2024ko irailaren 20a, ostirala | XXII. urtea | 6.601. zenbakia | www.berria.eus | Prezioa: **1,60 euro**

Gaur HITZA

# berria



**Otsoaren biziraupena** ziurtatzeko eta otsoa eta abeltzaintza batera bizitzeko plana ondu du Jaurlaritzak

EUSKAL HERRIA | 8-9

# Hezbollahko buruak «Israelen gerra ekintza» gisa hartu ditu Libanoko gailuen leherketak

- Hassan Nasrallahk erasoak gaitzesteko adierazpena egin ondoren, Hezbollahren posizioak gogor bonbardatu ditu Israelek.
- Hezbollahk «lerro gorri guztiak» igarotzea egotzi dio Israeli, eta «eraso terroristak erantzun justua» izango duela agindu.



**Gilbert Achcar:** «Iran gerran sartzea da Israelentzako benetako arrisku bakarra»

HARIAN | 2-3

«Ez diot inongo zentzurik ikusten euskal selekzio bat edukitzeari»

**ENEKO ANDUEZA**
*PSE-EEko idazkari nagusia*

EUSKAL HERRIA | 4-5

## Euskal Eskola Publikoaren I. Plan Estrategikoa onartu nahi du Pedrosak

Hezkuntza Legea eta eragileen arteko akordioa garatzea eta segregazioaren aurkako ituna sustatzea jarri ditu helburutzat Jaurlaritzako sailburuak.

EUSKAL HERRIA | 7



## HITZIK ERE EZ

Talibanekin, Afganistango emakumeen bizimodua okerragoa da egunetik egunera.

MUNDUA | 13

## Europako autogileek presioa handitu dute Bruselak emisioen mugak atzeratzeko

EKONOMIA | 12




Langileak, atzo, Zinemaldiko alfonbra gorria zabaltzen. JUAN HERRERO / EFE

# DONOSTIA, IZAR HIRIA

Gaur hasiko da Zinemaldia, eta izarrak hasiak dira iristen; Javier Bardemek iazko Donostia saria jasoko du.

KULTURA | 22-23

# Hezbollahko buruak «gerra deklaraziotzat» hartu ditu azken egunetako erasoak

→ Israelek Hezbollahren posizioak bonbardatu ditu Libanon, Nasrallahren hitzaldiaren ostean.

→ NBEk Israeli eskatu dio amai dezala Gazaren «legez kanpoko okupazioa», eta urtebeteko epea eman dio horretarako; ebazpena ez da loteslea.





**Arantxa Elizegi Egileor**
**Aitor Garmendia Etxeberria**

«Gerra ekintza bat izan da, Libanoko herriari eginiko gerra deklarazio bat». Horrela definitu zituen azken egunetako erasoak Hezbollah talde xiitako lider Hassan Nasrallahk. Atzo arratsaldean eman zuen bere adierazpena, eta, une berean, Israelgo armadako hegazkinak ibili ziren Beirut inguruan. Ondoren, beste urrats bat eman, eta Israelek Hezbollahren posizioak bonbardatu zituzten Libanon. Herenegun hitz egin zuen Israelgo Defentsa ministro Yoav Gallantek, eta ohartarazpen hau egin zuen: «Beste fase batean sartu da gerra. Hainbat hilabetez Gazan Hamasen aurka borrokatu ostean, grabitate zentroa iparraldera mugitu da, baliabideak eta indarrak desbideratuta». Israelek ez du orain arte hitzik egin Hezbollahren aurkako azken bi egunetako erasoez —gutxienez hamabi pertsona hil ziren asteartean talde armatuko kideen bilagailuak leherrarazita; herenegun, berriz, walkie-talkieak zartarazi zituzten, eta, gutxienez, 25 dira hildakoak—, baina Gallantek zoriondu egin zituen herrialdeko informazio zerbitzuak erdietsitako «lorpen handiengatik».

Nasrallahk adierazi zuen Israelek «lerro gorri guztiak» igaro dituela azken egunetako erasoekin. Jakinarazi zuen 4.000 gailu baino gehiago lehertu dituztela, eta esan zuen une beran 4.000 lagun hiltzea zela Israelen asmoa. Hori «ekintza terrorista» izendatu zuen, eta «erantzun justua» emango diotela baieztatu. Bestalde, hitzeman zuen Hezbollahk «Gazako erresistentzia babesten» jarraituko duela eta ez dietela utziko Israelgo «legez kanpoko kolonoei» iparraldera itzultzen. Atzo bertan zenbait eraso egin zituzten eta, Israelgo armadak jakinarazi zuenez, bi militar hil ziren Hezbollahren eraso batean.

Benjamin Netanyahu Israelgo lehen ministroak erasoez geroztik egindako lehen agerraldian iragarri zuen euren helburua dela Israel iparraldean bizi diren kolonoak «etxeko segurtasunera itzuli ahal izatea» bermatzea. Segundo gutxi batzuk iraun zuen agerraldiak, baina nahikoa Tel Aviven asmoak argi uzteko. Izan ere, Reuters agentziaren arabera, Libanoko mugara mugitu zen Israelgo armadaren 98. dibisioa, lehen Gaza iparraldean zegoena.

NBE Nazio Batuen Erakundeko idazkari nagusi Antonio Guterresek gaitzetsi egin zituen erasoak, eta indarkeria geldiarazteko eskatu zien bai Israeli eta bai talde armatu xiitari. Erakundea gaur da biltzekoa, itxuraz, Israelgo informazio zerbitzuen esku hartzearen bitartez egindako erasoez hitz egiteko. Dena den, Guterresek berak nabarmendu zuen operazioak Libanoren aurkako eraso «zabalago baten aurrekaria» izan litezkeela: «Argi dago tresna horiek denak leherraraztearen asmoa dela kolpe prebentibo bat eragitea operazio militar handiago bat hasi aurretik».

Gazaren aurkako erasoaldia hasi zenetik, gogortu egin dira Israel eta talde armatu xiitaren arteko borrokak. Baina bi egunotakoa bezalako operaziorik ez da orain artean ikusi. Libanoko informazio iturrien arabera, Hezbollahk komunikaziorako baliatzen zituen 2.800 bilagailu zartarazi zituzten aldi berean.

Ez dago oraindik argi bilatzaile horiek nork eta non egin zituzten. Baina *The New York Times* egunkariak Israelgo iturriak aipatuz zabaldutako informazioaren arabera, Hungariako BAC enpresak zuen gailu horiek ekoizteko kontratua. Horiek, AEBetako egunkariaren arabera, Taiwango enpresa batentzat ziren, Gold Apollorentzat. Ordea, kazetak zabaldu duenez, Israelgo informazio zerbitzuak arduratu ziren egiaz gailuak egiteaz, eta Hungariako konpainia baliatu zuten beren lana ezkutatzeko.

### NBEren ebazpena

Palestinako buruzagiek historikotzat jo duten ebazpena onartu zuen herenegun gauean NBEk. Hartan, Tel Avivi eskatu dio amai dezala «legez kanpoko okupa-



## Gutxienez beste hiru hildako Zisjordanian

● **Atzo gutxienez hiru palestinar hil zituen Israelgo armadak, Zisjordaniako Jenin hirian egindako sarekada batean. Hori jakinarazi zuen Palestinako Wafa berri agentziak. Kaleratu zuen informazioaren arabera, hiru soldadu etxe bat miatzera sartu ziren; ondoren, hiru gorpu atera zituzten teilatutik. Irail hasieran, Zisjordaniaren aurkako aspaldiko erasoaldirik bortitzena hasi zuen Israelek, eta 30 pertsona baino gehiago hil ditu ordutik.**



↑Libanoko herritarrak Hassan Nasrallah Hezbollahko liderraren agerraldiari begira, Beiruten. WAEL HAMZEH / EFE

zioa», eta urtebeteko epea eman dio horretarako. Eskariaren alde bozkatu zuten 124 estatutako ordezkariek, eta aurka hamalauk; 43 abstenitu egin ziren —aurka bozkatu zutenen artean daude Argentina eta AEBak—. Eskaria ez da loteslea, ordea.

Bien bitartean, erasoaldiaren urteurrenerako egun gutxi batzuk falta diren honetan, Netanyahuren gobernuak Gaza bonbardatzen jarraitzen du etengabe. Atzo Rafah mendebaldea izan zuten jomuga, zehazki Al-Mawasi eremua. Gazako beste hainbat tokitatik ihesi joandako ehunka desplazatu daude bertan aterpe hartuta. Era berean, Gaza hiriaren hego-ekialdea ere bonbardatu zuten, eta tiroketak izan ziren Khan Yunis ekialdean.

UNRWA Palestinar Iheslarientzako Laguntza eta Lan Bulegoarenak dira azken hilabeteetan Israelek bonbardatutako eraikinetako asko. Hala salatu zuen erakundeko idazkari nagusi Phlippe Lazzarinik: «Gure langile gehiegi hil dira gure eraikinen aurkako bonbardaketetan. Desinformazio eta informazio oker asko zabaldu da, besteak beste, gure langileen hilketak zuritzeko asmoz, esanez Hamas edo antzeko talde armatuetako kideak direla. Salaketa publiko izugarriok ez dituzte frogatu, eta arriskutsuak dira». ●

# «Hezbollah Israelekin nolabaiteko gerra batean murgilduta egon da sortu zenetik»



BERRIA

## GILBERT ACHCAR

*Hezbollah eta Israelen arteko gatazkan aditua*

Azken egunetan, Israelek Hezbollahren aurka egin du eraso. Achcarrek esan du gerra bete-betean hasiz gero Iranek esku hartu beharko duela.

**Mikel Garcia Martikorena**

Gilbert Achcar (Dakar, 1951) Nazioarteko Harremanetako irakaslea da Londresko Unibertsitatean. Senegalen jaio eta Libanon hazia, Hezbollahren eta Israelen arteko gatazka izan du ikergai, eta Ekialde Hurbileko gatazken inguruan idatzi du; besteak beste, *The 33-Day War: Israel's War on Hezbollah in Lebanon and its Consequences*, 2007an (33 eguneko gerra: Israelek Libanon Hezbohllaren aurka egindako gerra eta haren ondorioak). Haren ustez, Israelek Hezbollahko kideen aurka azken egunetan egindako erasoak «azken abisu bat» dira, eta Palestinako gatazka eskualdera hedatzeko arriskuaz ohartarazi du.

**Non ditu sustraiak Hezbollahren eta Israelen arteko gatazkak?**

Sortu zenetik, Hezbollah Israelekin nolabaiteko gerra batean murgilduta egon da. Israelek 1982an Libano inbaditu ostean sortu zen Hezbollah; 1985ean, hain zuzen. Israelgo okupazioaren aurkako borroka hori izan da Hezbollahren identitatearen ezaugarri nagusia; beren buruari erresistentzia islamikoa esaten diote. 2000. urtean Israelgo armada Libanotik joan zen arte, garrantzi handia izan zuten borroketan. Gero, armak ez uztea erabaki zuten, arriskuak hor jarraitzen duela iritzi diolako.

**Eta gaur egungo gatazkak?**

Joan den urriaren 8an hasi zen, Hamasek Israelen aurka eraso egin eta biharamunean. Israel iparraldea bonbardatzen hasi ziren. Eraso horien helburua Israelgo armadaren arreta desbideratzea izan da; betiere gerra bete-betean hasi gabe.

**Nor da Hezbollahko kideen gailu teknologikoen eztanden erantzulea?**

Oso argi dago: Israel izan da. Haren zerbitzu sekretuak espezializaturik daude halako erasoetan. Diotenez, Hezbollahko kideren batek susmoa zuen zerbait gaizki zegoela tresna horiekin, eta, horrek hankaz gora jarri ahal zuenez plana, eztandak aurreratzea erabaki zuen Israelek. Izan ere, tresna horien eztanda askoz eraginkorragoa izango litzateke Israelek gerra bete-betean hasteko orduan lehertuko balitu.

**Uste duzu gerra bat piztu daitekeela Ekialde Hurbilean, beste herrialdeen parte hartzearekin?**

Israelek Hezbollahren aurkako gerra bete-betean hasten badu, Iranek erantzun egin beharko du. Izan ere, Hezbollahk argi adierazten du Iranen indar militarren parte dela. Iranek ez balu ezer egingo, sinesgarritasun oro galduko luke. Eta Iran gerran sartzea da Israelentzako benetako arrisku bakarra. Biek Israel bonbardatzen badute, AEBen laguntza beharko du.

**Zer rol du Hezbollahk Libanon?**

Estatu barruan dagoen estatu bat da Hezbollah, nolabaiteko estatu paralelo bat. Estatu baten ezaugarri guztiak ditu: armada, Polizia, komunikazio iturriak, ekonomia propioa —Iranek finantzatua, noski— eta zerbitzu publikoak; osasuna, besteak beste. Xiiten estatua da Libano barruan. Hego Libanon eta hego Beiruten hainbat gune kontrolpean dituzte; xiita gehien duten guneak.

**Zein da Hezbollahren ideologia nagusia?**

Hezbollahren ideologiak bi ezaugarri nagusi ditu. Alde batetik, fundamentalismo islamikoa du oinarri. Irango Errepublika Islamikoaren ideiei jarraitzen diete kideek, eta Khomeini dute gidari [iraultza islamikoaren buru izan zen 1979an]. Kontrolatzen dituzten eskualdeek Iranen duten antzeko sistema bat dute.

Bestetik, haien identitatearen —eta irandarren— alde garrantzitsu bat Israelekiko oposizioa da. Iranen kasuan ez bezala, Hezbollahrentzat da zerbait ideologikoa soilik: hortik harago doa. Okupazioa eta bonbardaketak direla eta, oso presente dago Israel Libanoko herritarrengan.



«[Libanoko] Estatuaren barruan dagoen estatu bat da Hezbollah, nolabaiteko estatu paralelo bat»

**Israelek esan du gerra «fase berri batean» sartu dela. Zer esan nahi du?**

Israel presioa areagotzen ari dira, soldaduak iparraldera mugitzen ari dira. Gazan gerra intentsiboaren fasea amaitu dutelako egin dute hori. Hala ere, ez dute Hezbollahren aurkako gerra bat hasiko AEBen oniritzirik gabe. Hezbollahren aurkako gerra batean gatazka militarra eskualdera zabaltzeko arriskua duenez, AEBen laguntza behar du Israelek. Gaur-gaurkoz, [AEBetako presidente Joe] Bidenen administrazioa Libanon gerra bat hastearen aurka agertu da.

**Zer espero dezakegu datozen hilabeteetan?**

AEBetako hauteskundeen emaitzen araberakoa izango da. [Israelgo lehen ministro Benjamin] Netanyahu bozei oso adi dago. Donald Trumpek irabaztea nahi du, noski. Netanyahuk ez zuen onartu Bidenek proposatutako su etena, eta, horrela, opari bat egin dio Trumpi. Trumpek irabaziko duela uste badu, ez du eraso handirik egingo hura Etxe Zurira heldu arte; gero, Trumpek kargu hartutakoan, haren babesarekin egingo du eraso.

Kamala Harrisek irabaziko duela uste badu, baliteke gerra aurreratzea Bidenen presentziaz baliatuta. Bi hilabetez egongo da Biden Etxe Zurian hauteskundeen ostean, eta tarte horretan ahul egongo da presidentea. Biden Israelen aldekoegia da haien aurkako neurririk hartzeko. ●

Xabier Martin



OSKAR MATXIN EDESA / FOKU

# «Abertzaleek herrialde bat sortu nahi dute soilik beraientzat»

## ENEKO ANDUEZA

*PSE-EEko idazkari nagusia*

Estatutu berria negoziatzen hasi aurretik, PSE-EEko burua irmo azaldu da abertzaleen nahien aurrean: «Haien helburu nagusia independentzia da». Anduezak ez du nahi «Euskadirentzat Katalunian jasandako hori».

EAJri abisu argia eman dio Eneko Anduezak (Eibar, Gipuzkoa, 1979) Espainiako Kongresuan Sanchezi ematen dion babesa dela eta: babes hori aldatuko balitz, horrek eragina izango luke alderdi biek duten itunean.

**Arriskuan da EAJrekin daukazuen ituna?**
Orain ez, baina gauzak aldatzen badira Madrilen, hausnarketa bat egin beharko dugu denok. Egungo gobernuaren alternatiba latza da: eskuina eskuin muturraren eskutik. Beraz, joka dezagun seriotasunez denok. Egia da, dena den, EH Bildurekin duen lehian kokatzen dudala EAJren jarrera, haiek ere burua altxatu nahi baitute.
**Ortuzarrek deitu dizu estatutu berriaz hitz egiteko?**
Ez.
**Gehiengo abertzaleari pluraltasuna ukatu diozu. Zergatik ez luke pluraltasuna ordezkatuko gehiengo horrek?**
Bloke abertzale bat izango litzateke, eta aniztasuna beste gehiengo batek ordezkatzen du gobernuan. Euskadiren aniztasuna ezin da ordezkatu nazionalismo baten gotorleku modura. Ezin da onartu gobernatzeko gehiengo bat erabiltzea eta beste gehiengo bat beste gauza batzuetarako. Gehiengo bat daukate parlamentuan, baina kalean sumatzen dena ez da abertzaletasun hori.
**EAJren eta PSEren 39 eserlekuek pluraltasuna ordezkatzen dute, eta EAJren eta EH Bilduren 54 eserlekuek ez?**
Horrela da. Haien helburu nagusia independentzia da; abertzaleek herrialde bat sortu nahi dute soilik beraientzat. Beste garai batzuetan ere gehiengoa izan dute, eta batu egin dira, eta badakigu zertan bukatu den: porrotean eta kaleko haustura batean. Kataluniakoa ere hor dago. Zorionez, aldaketa izan da orain han. Nik ez dut nahi Euskadirentzat Katalunian jasandako hori.
**Esan duzu inkesten arabera indarra galdu duela independentziaren hautuak. Zerk erabaki behar du gehiengoaren nahia, inkestek ala gehiengo parlamentarioek?**
Egonkortasuna behar da hemen: ez dugu abenturarik nahi. EH Bilduri eta EAJri hausnarketa bat eskatuko nieke. Haien alde bozkatzen duten pertsona guztiak ez dira independentistak, eta inkesta guztiek esaten dute hori, beraienek ere bai. Gero eta txikiagoa da independentziaren aldeko sentipena. Eztabaida ez dago kalean. Parlamentuko gehiengo abertzale horrekin bat egiten du haien aldeko botoa eman duten guztiek? Ez dut uste.
**Inkestengatik, EAJk eta EH Bilduk ez dute zilegitasunik itun bat egiteko?**
Askatasun osoa dute bide hori egiteko, baina gu ez gaituzte hor edukiko. Batu daitezela hala nahi badute, baina baita erakundeei egonkortasuna emateko ere.
**Illak «Kataluniako nazioa eraikitzeko» deia egin du. PSE prest legoke euskal nazioa aitortzeko estatutu berrian, nazio gisa?**
Oraingo estatutuan horrela onartuta baldin badago, zergatik ez onartu berrian ere?
**Nazionalitatea aipatzen da, ez nazioa.**
Posible izango da —edo, behintzat, PSEk horrela uste du— halako termino bat estatutuan jasotzea, denok eroso sentitu gaitezen. Beste erkidego batzuetan ere jaso dute, Aragoin eta Andaluzian, adibidez.
***Nazio* hitzak eta kontzeptuak adiera bera dute Aragoiri buruz aritzean, eta Araba, Bizkai eta Gipuzkoari buruz aritzean?**
Bai, zergatik ez?
**Nazio aitortza idatzita geratuko balitz, PSEk onartuko luke euskal selekzioak ofizialki lehiatzea?**
Harrigarria da batzuk beti gauza identitarioetan tematzea. Hurrengo estatutuan ezinbestekoa dena da etorkizunerako benetan garrantzia duena jasotzea eta indartzea. Euskal selekzioa eta horrelakoak gauza identitarioak dira. Eskubide sozialak blindatu behar dira estatutu berrian, eta orain ez daudenak estatutura eraman.
**Espainiar nortasuneko euskal herritarrek euren nazioa lehiatzen ikus dezakete; euskal selekzioak ofizialki lehiatzearen alde zaude, ala aurka?**
Ez diot inongo zentzurik ikusten euskal selekzio bat edukitzeari, baina ez bakarrik identitarioa delako; lehiakortasunari begira ere nahiago dut oraintxe dugunarekin jokatzea. Dena den, errespetagarriak dira aldarrikapen horiek.



«EH Bilduren eta EAJren alde bozkatu duten pertsona guztiak ez dira independentistak»

«Ez diot inongo zentzurik ikusten euskal selekzio bat edukitzeari. Gauza identitarioak dira horiek»

«Ez nau kezkatzen Ezkioko geltokia eginda egoteak: beste erabilera batzuk izan ditzake»

**Jaurlaritza berria abiatu da Mikel Torres lehendakariorde dela. Ez da euskalduna. PSEk ez zuen postu goren horretarako pertsona euskaldunik?**
Gobernuan jarri ditugun pertsona guztiak gaitasun handikoak dira. Agian batzuek lehentasuna emango diote hizkuntzari, baina nik nahiago dut ardura handiko postuak kudeatzeko gaitasuna duen pertsona bat.
**Euskal administrazioa euskalduntzeko xedea izan duten gobernuetan egon zarete urte askoan. Lehendakariorde batek ez badu zertan jakin euskaraz, nola lortuko da helburu hori?**
Gipuzkoan, EH Bilduko gobernu bat izan genuen, eta foru diputatu guztiak ziren euskaldunak. Gero, badakigu haien kudeaketa zein txarra izan zen. Hemen garrantzitsuena da ondo kudeatzea. Hizkuntza eskubideak oso garrantzitsuak dira, eta errespetatzen ditut, baina harrigarria da batzuek hainbesteko garrantzia ematea.
**Justizia eta Giza Eskubideen Saila zuen esku dago orain. Gogora institutuan aldaketak behar direla aipatu duzue. Zer-nolakoak?**
Egin ez dena egin behar da. Arduradun batek bere ideiak ezartzen ditu bere kudeaketan; guk gure logika ezarriko dugu, beste logika bat. Gertaerak landu dira Gogora-n, baina ez hainbeste horien erantzuleen ingurukoan. Egia, justizia eta erreparazioa dira garrantzitsuena, eta asko dago egiteko, batez ere egia guztia jakiteko.
**Gogora-k ez du nahikoa landu ETAren biktimen oroimena?**
Gogora ez dago bakarrik ETAz aritzeko; frankismoa ere landu behar du, eta arlo bi horietan ez da askorik hitz egin biktimarioez. Agian, interesgarria da gizarteari esatea gertaera horien atzean zein egon zen, abizen euskaldun ugari aterako dira eta.
**Gasteizko alkate sozialistak, Maider Etxebarriak, Urrezko Domina eman dio Terrorismoaren Biktimen Oroimenezko Zentroari. Egokia iruditzen zaizu?**
Bidezkoa da: erakunde hori lan garrantzitsua egiten ari da.
**Zentro horrek polizia soil modura aitortu du Meliton Manzanas torturatzaile eta Gestapoko kolaboratzailea, eta Martxoaren 3ko biktimez ez du ezer jaso. Zer iruditzen zaizu?**
Martxoaren 3ko biktimek beren fundazioa izango dute, eta guk parte hartze zuzena izan dugu beren espazio propioa izan dezaten. Bestalde, Gasteizko Memorialak ez zuen hasieran GALi buruz ezer jaso, eta, gure ekarpenari esker, GAL ere sartu dute.
**Meliton Manzanas eta Carrero Blanco oroitu dituela eta, zuzenketarik ez du egin behar erakunde horrek?**
Hori azpimarratu behar bada, ez dago arazorik egiteko. Nik oso argi daukat nor izan ziren.
**«Azpimarratu» esatean, zer esan nahi duzu, haien jarduera zein izan zen azaltzea?**
Esango nuke hori jasoa dagoela Memorialean.
**Ez dago.**
Zuzendu egin beharko da orduan. Baina askok indarra leku berean jartzen dute beti. Beraiek egindakoan ere indar bera jarriko balute, Euskadin gauzak askoz hobeto leudeke. Bada alderdi bat eragin duen mina aitortu ez duena. Aitzitik, beste batzuek egindakoari baino ez diote begiratzen. Eta ondo dago, baina, aizu, beraiek egindakoaz ere zerbait esan zezaketen, eta behingoz esango balute, Euskadik eskertuko luke.
**Alderdi bat? EH Bildu?**
Bai, ezker abertzalea, logikoki.
**EH Bilduk «eragindako samina bihotzez sentitzen» duela esan die biktimei behin baino gehiagotan.**
Oraindik bide dezentekoa dauka egiteko.
**Ezkio ala Gasteiz. AHTaren ibilbideak ika-mika handia piztu du. Zer nahiago zenuke?**
Eneko Anduezak, PSEko idazkari nagusi gisa, ez du bata ala bestea lehenesten. Txostenen zain gaude.
**Ezkioko geltokia eginda dago. Eta ez balitz handik egingo, azkenerako?**
Ez nau kezkatzen: beste erabilera bat emango litzaioke. ●

# Atutxak Anduezari ohartarazi dio ez duela «beto eskubiderik»

→ Baieztatu du EAJk urrian hasiko dituela estatutu berri bat onartzeari buruzko elkarrizketak alderdiekin.

Gurutze Izagirre Intxauspe



Itxaso Atutxa EAJren BBBko lehendakaria. JAIZKI FONTANEDA / FOKU

Estatutu berriaren negoziazioa izan da urte politikoaren hasierako ardatza. Alderdi eta erakunde nagusietako ordezkariak zer jarrera duten adierazten ari dira, negoziazioaren atarian. Itxaso Atutxa EAJren Bizkai Buru Batzarreko lehendakariak Eneko Andueza PSE-EEko idazkari nagusiari atzo esan zion ez duela «beto eskubiderik». Onda Vascan egindako elkarrizketa batean, esan zion erreparatzeko Pedro Sanchez Espainiako gobernuburuak inbestidurarako babesa lortzeko asmoz EAJrekin egindako akordioari. Halaber, baieztatu zuen urrian hasiko direla alderdiekin elkarrizketan.

Andueza prest da estatutu berri bati buruz hitz egiteko, baina estatus berri bati buruz aritzeko ez. Atutxak erantzun zion hori ez duela Anduezak erabakiko, «baizik eta herri honek eta legebiltzarreko gehiengoak». EH Bilduri erreparatuta, esan zion ez duela «inposatzeko eskubiderik». Anduezari esan zion irakurtzeko Sanchezek EAJrekin egindako ituna, Atutxaren ustez, Gernikako Estatututik harago joatea jasoa baitago han, «baita Estatuaren eta Euskadiren arteko harremanetan ere».

Itxaso Atutxak ez zuen auzitan jarri, halere, EAJren eta PSE-EEren arteko akordioa. Erakundeak gobernatzeko egindako akordioak argiak direla esan zuen, eta gobernabidea eta estatutu berrirako eztabaida bereizi egin zituen.

Sanchez ere izan zuen hizpide, eta uste du gero eta zailagoa daukala legealdiari eustea. «Batzuetan, ahaztu egiten zaie gaiak Kongresura eraman aurretik hitz egin behar dela, eta bozkatu baino lehen ados jarri». ●

## Capdeviellek eskatu du bi euskal presoren egoera arintzeko

**EUSKAL PRESOAK**— Oraindik bi euskal preso daude DPS estatusaren pean —bereziki zaindutako presoei ezartzen zaie—, eta estatus hori kentzeko eskatu dio Colette Capdevielle euskal diputatuak Frantziako kartzeletako kontrolatzaile nagusi Dominique Simonnoti. Asteazkenean egin zuen eskaria Capdeviellek, Frantziako Asanblean. Euskal Herriko beste bi diputatuen —Peio Dufauren eta Iñaki Etxanizen— izenean ere egin zuen eskaria; hirurak dira Fronte Popular Berriko diputatuak, eta Iparraldeko herritar gehienek hautatu zituzten udan egindako hauteskundeetan.

DPSa 30 presori baino gehiagori ezarri diete azken hamarkadetan; gehienak euskal presoak eta Korsikakoak izan dira. Bi baino ez daude oraindik DPS estatusaren pean: Mikel Karrera eta Saioa Sanchez euskal presoak.

# Pedrosak Hezkuntza Legea eta akordioa garatzea du legealdiko helburutzat

→ Eusko Jaurlaritzako Hezkuntza sailburuak Euskal Eskola Publikoaren I. Plan Estrategikoa onartzeko asmoa erakutsi du, baita segregazioaren aurkako ituna sustatzekoa ere.

**Irati Urdalleta Lete**

Hasi berri den legealdirako ildo nagusien berri ematea eta erronkak zehaztea. Horiek izan ziren Begoña Pedrosa Eusko Jaurlaritzako Hezkuntza sailburuak atzo goizean Eusko Legebiltzarreko Hezkuntza Batzordean egin zuen agerraldiko xede nagusiak. Datozen lau urteetarako talde berria du Pedrosak ondoan, «baina eskarmentu handikoa». Eta badute zereginik: «Euskal hezkuntza sistema bere osotasunean» hobetzea jarri dute helburutzat. Baina bide hori lagunduta egiteko asmoa dute, ez bakarrik. Horretarako, gizarte eragileei mezua helarazi die: «Azpimarratuko nuke elkarrizketarako eta akordiorako borondatea erakutsiko dugula». Zehaztuak dituzte datozen lau urteetan urratuko duten ibilbideko erronka nagusiak:



Hezkuntza Saileko ordezkarien agerraldia, atzo, Eusko Legebiltzarrean. JAIZKI FONTANEDA / FOKU

## Lege esparrua

Aurreko legealdiko mugarria izan zen EAEko Hezkuntza Lege berria erdiestea, eta hura lortzeko prozesuak zeharkatu zuen legealdi osoa. 2022ko martxoan izenpetu zuten legearen oinarri izateko jaio zen akordioa, EAJren, EH Bilduren, PSE-EEren eta Elkarrekin Podemos-IUren babesarekin. Alabaina, adostasuna kamustu egin zen, eta EAJk eta PSE-EEk baino ez zuten onartu legea, 2023ko abenduan. Orain, Pedrosak horiek biak garatzearen aldeko apustua egingo dutela ziurtatu du; legealdiko haien erronketako bat izango da Hezkuntza Legea eta hezkuntza akordioan jasotako 43 jarduerak «erregelamendu bidez» garatzea. Ildo horretatik, ituneko «konpromisoei» erantzungo dietela ziurtatu du.

## Eskola publikoa

Sare publikoko eragileek joan den legealdian sarritan plazaratu izan zituzten kezkak eta ezinegonak. Orain, Pedrosak agindu du Euskal Eskola Publikoaren I. Plan Estrategikoa garatuko dutela. Horri hertsiki lotuta, ikastetxe publikoen azpiegiturak ere hobetu asmo dituzte. Eta kopuru zehatza eman du: «800 milioi inbertitu nahi ditugu datozen urteetan azpiegitura berrietarako eta espazioak berriz formulatzeko». Horretarako, azpiegitura plan berria egingo dute.



> **«800 milioi inbertitu nahi ditugu datozen urteetan [ikastetxe publikoetan] azpiegitura berrietarako eta espazioak berriz formulatzeko»**
>
> BEGOÑA PEDROSA
> Jaurlaritzako Hezkuntza sailburua

Halaber, ikastetxe publikoen autonomian sakontzea ere jarri du xedetzat, eta horretarako «arau esparrua» martxan jarriko dutela hitzeman du. Ildo horretatik, esan du zuzendaritzek ikastetxeko giza baliabideen gainean «autonomia handiagoa» izatea nahi dutela; aipatu du, adibidez, behar dituzten langileen profilak proposatzeko aukera eduki ahal izatea. Oro har, langileei dagokienez, egonkortasuna dute ortzi mugan: behin-behinekotasuna %5era jaitsi asmo dute, baita irakasle gehiago hartu ere.

## Ikasleen segregazioa

Ikasleen segregazioa da egun Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako hezkuntzako arazo edo erronka nagusietarikoa. «Kalitatezko sistema inklusiboa, ekitatiboa eta komunitatearen elkarlanean oinarritutakoa» lortu nahi dute: «Ez dugu inor atzean utzi nahi». Horretarako: «Eskola segregazioari aurre egiteko itun soziala garatzeko garaia da; aukera historikoa daukagu gure aurrean, eta ausardiaz heldu beharko diogu». Baina ez dira hutsetik hasiko. Dagoeneko aldaketa batzuk eginak dituzte, esaterako, matrikulazio sisteman, eta horiei eusteko asmoa erakutsi du Pedrosak.

## Euskara

Ikasleen euskara maila hobetzea da hezkuntza sistemako beste erronketako bat. «Euskara testuinguru formalean eta ez-formalean erabiltzea bultzatuko dugu», ziurtatu du Pedrosak. Halaber, «eleaniztasuna bultzatzeko» ere egingo dute lan. Hizkuntzen arloan, egitasmo bat ere iragarri du, Hezkuntza Legean jasota dagoena: Euskararen eta Hizkuntzen Ikaskuntzarako Institutua martxan jartzeko asmoa dute.

## Digitalizazioa

Eskoletan pantailak erabili behar ote diren, eta zertarako. Eztabaida piztuta dago. Sailburuak nabarmendu du digitalizazioa «arduratsua eta segurua» izan behar dela: «Hezkuntzak badauka ardura bat; ezin dugu beste aldera begiratu». Horregatik, legealdiko jomugatzat dute hezkuntza sistemaren estrategia digitala indartzea. Eta adimen artifiziala ere izan du hizpide: «Beharrezkoa da hezkuntzaren eta adimen artifizialaren artean zubiak eraikitzea».

## Lanbide heziketa

Sailburua berariaz aritu da Lanbide Heziketarako dituzten asmoez. 2030eko Lanbide Heziketako Euskal Plana diseinatu nahi dute, eta, besteak beste, eredu duala —ikasketak ikastetxeetan eta enpresetan egitea– sustatzen jarraitu asmo dute: «Ikasleen %100 lantoki batean trebatu ahal izango dira etorkizunean». Gainera, euskara eta eleaniztasuna indartzearen garrantzia nabarmendu du. ●

# Otsoa eta abeltzaintza «elkarrekin bizitzea» bermatuko duen plana ondu du Jaurlaritzak

→ Otsoaren erasoetatik babesteko laguntza profesionala eskainiko diete abeltzainei, eta otsoaren isilpeko ehizari jazarriko zaio.

→ Hilabeteko epea ireki dute alegazioak aurkezteko.



↑Otso bat (*Canis lupus*), Asturiasen (Espainia).
J.L. CEREIJIDO / EFE

**Edurne Begiristain**

GASTEIZ—Abeltzaintza estentsiboaren eta otsoaren arteko elkarbizitza bermatze aldera, otsoa kudeatzeko planaren proiektua ondu du Eusko Jaurlaritzako Industria, Trantsizio Energetiko eta Jasangarritasun Sailak. EAEko aldizkari ofizialak atzo argitaratu zuen egitasmoa, eta gaurtik aurrera alegazioak egiteko hilabeteko epea egongo da, behin betiko onartu aurretik. 2020an otsoa (*Canis lupus*) «interes bereziko espeziea» izendatu zuen Eusko Jaurlaritzak. Espezie Mehatxatuen Katalogoak lau kategoriatan sailkatzen du babes maila: «galzorian dauden espezieak», mailarik gorenean; «kalteberak», hurrengo mailan; «bakanak», babes ahulagoarekin; eta, azkenik, «interes berezikoak» mailarik apalenean. Azken maila horretan sailkatua dago otsoa Araban, Bizkaian eta Gipuzkoan.

Otsoaren kudeaketa arautzeko plana ontzeko, gobernuak hainbat eragileren ekarpenak jaso ditu —abeltzaintzako ustiategiak dituzten partikularrenak, Ekologistak Martxan, Asociacion para la Conservacion y Estudio del Lobo Iberico, eta Ascel elkarte ekologistenak—, eta Araba, Bizkai, eta Gipuzkoako foru aldundienak, otsoaren kudeaketan eskumenak dituzten administrazioak diren heinean.

## Xedea

Planaren xedea da otsoaren gaineko «mehatxuak ezabatzea», otsoaren «biziraupena ziurtatzea», haren populazioa «berreskuratzea eta kontserbatzea», haren habitatak babestea, eta otsoa abeltzaintzarekin eta landa ingurunean garatutako beste jarduera batzuekin «elkarrekin bizi ahal» dela bermatzea.

Dokumentuaren 4.artikulua zehaztua dutenez, planaren iraupena «mugagabea» izango da, betiere otsoa Arriskuan Dauden Espezieen Euskal Katalogoan, Babes Bereziko Araubidean Dauden Espezieen Zerrendan, edota plana onartu ostean animalia sailkatzeko sortzen diren bestelako zerrendetan sartua dagoen bitartean. Sei urtean behin berrikusiko dute dokumentua.

## Otsoaren babesa

Otsoa legez kanpo hiltzeko edozein prozedura (armak, pozoia, biozidak...) detektatzeko eta prebenitzeko eskumena izango dute basozainek eta ingurumen agenteek. Zaintza areagotuko da otsoa «legez kanpo jazarria» edo harrapatua izan ez dadin. Horretarako, isilpeko ehiza prebenitzeko eta hari jazartzeko jarduera protokolo bat adostuko dute. Gainera, harrapakete eragines otso gutxiago hil daitezen egokitzat jotzen diren pasabideak eraikiko dituzte.

Debekatuta egongo da, halaber, bizirik zein hilak dauden otsoak —eta haien gorpuzkiak— edukitzea, administrazioek berariaz baimendutako kasuetan izan ezik. Plana indarrean sartu eta urtebeteko epean, gatibu dauden otsoen edo haien gorpuzkien erregistro informatizatua sortuko dute.

Otso aleak bizirik harrapatzeko baimena eman ahalko da, haien azterketa edo jarraipen zientifikoa edota tratamendu sanitarioa egiteko helburua baldin badu, eta ez badu animaliaren kontserbazio egoera arriskuan jartzen.

Berariazko baimenik izan ezean, debekatuta egongo da otsoa erakartzeko edozein jarduera eta sistema erabiltzea (soinu sistemak adibidez), argazkiak eta bideoak ateratzea, eta animaliak gauez behatzeko argi fokuak edo infragorrien bisoreak erabiltzea.

## Otsoa eta abeltzaintza

Basa faunaren eta abeltzaintzaren kudeaketan eskumena duten organoek abeltzaintzako «jardunbide egokien eskuliburu bat» egingo dute otsoa eta abeltzaintza bateragarri egiteko. Planaren arabera, eskuliburuan jasoko diren jarduera horiek egoera eta lurralde historiko bakoitzeko erasoen arabera, eta ustiategi motaren eta bideragarritasun ekonomikoaren arabera egokituko dira.

Administrazioek neurriak hartuko dituzte otsoak abeltzaintza ustiategiei «ahalik eta kalte gutxiena» eragin diezaien. Besteak beste, erasoen prebentziorako programa bat onduko dute, zeinetan hurrengo neurriak jasoko dituzten: ganadua zaintzeko txakurrak (mastinak) erabiltzeko prestakuntza eta trebakuntza, perimetroko hesiak instalatzea eta jarrita daudenen egoeraren inbentarioa egitea, eta gailu elektronikoak eta digitalak martxan jartzea.

Horrekin batera, otsoarekin batera bizitzeko neurriak ezartzen dituzten abeltzaintza ustiategien erregistro bat sortuko da; ustiategietako jabeek bertan izena ematea borondatezkoa izango da.

## Kontrolik gabeko txakurrak

Txakurrak edukitzeari buruzko araudia eguneratuko dute, jarduera eremua landa edo abeltzaintza eremuetan txakurrak egoteko baldintzetara zabalduz. Otso espezieen eta txakurren arteko hibridazioak saihesteko, eta ganaduari eragin diezaioketen kalteak gutxitzeko, aldundiek kontrol neurriak abian jarri ahal izango dituzte.

## Babes neurriak

Lau zerbitzu eskainiko dira abeltzaintza estentsiboa otsoaren erasoetatik babesteko: ekipo mugikorrak, laguntza profesionala, boluntarioak, eta ingurumen zerbitzuengatiko ordainketa.

- **Ekipo mugikorrak:** Gizataldeak sortuko dira otsoak ganaduari eraso diezaiekeen ustiategiei laguntzeko. Otsoaren presentzia ohikoa den tokietan lan egingo dute talde horiek, eta beren eginkizunen artean hauek egongo dira: otsoaren ustezko eraso baten ondorioz abelbu-



ruak aurkitzea, biltzea eta egoera egiaztatzea, gauean artaldeei laguntzea eta otsoak eragindako kalteen inguruko ikuskapenetan laguntzea.

- **Laguntza profesionala:** Ustiategiei laguntza emango diete ganadua babesteko, ganadua maneiatzeko eta ustezko erasoen ostean abelburuak zenbatzeko eta kalteei buruzko txosten teknikoak egiteko.
- **Boluntarioak:** Abeltzaintza estentsiboetako ustiategiei lan karga arintzen lagunduko diete boluntario taldeek.
- **Ordainketa programa:** Ustiategi profesionalentzat izango da zerbitzu hori, baldin eta ganadua otsoa dagoen eremuetan mantentzen badute. Besteak beste, otsoak egoteak ganaduaren zaintzan eta kalteen prebentzioan dakartzan kostu gehigarriak konpentsatzeko helburua izango du programak.

## Konpentsazio ekonomikoak

Zuzeneko eta zeharkako kalte ordainak emango dituzte otsoak abeltzaintzari eragindako kalteengatik. Zuzeneko laguntzak erasoaren ondoren hildako eta larri zauritutako animaliengatik eta abortuengatik emango dira, bai eta erasoa gertatu eta hurrengo 72 orduetan horrelako egoera batean aurkitutakoengatik ere. Zeharkako laguntzak, berriz, zauritutako animaliak sendatzeko albaitaritza tratamenduetarako izango dira.

Foru aldundiek zehaztuko dituzte konpentsazioak jasotzeko baldintzak, eta kontzeptu bakoitzerako balorazio baremoak. Abeltzainek jasoko duten diru kopuruaren zenbatekoa eta aseguru polizetan zehaztua dutena bateragarriak izango dira.

Otsoaren ustezko erasoa izan eta, gehienez, 24 orduko epean jakinarazi beharko zaio administrazioari. Abeltzainak epe horretatik kanpo jakinarazten badu edo peritatzeak ondorioztatzen badu ez dela otsoa izan, ez da konpentsazio ekonomikorik emango.

## Kalteak egiaztatzea

Kalteak egiaztatzeko sistema «harmonizatu» bat ezarriko da, urte osoan martxan egongo dena. Abeltzainek otsoaren erasoen berri emateko telefono zenbaki bat martxan jarriko dute, eta abisua jaso eta ahalik eta eperik laburrenean egingo dira ikuskapenak. Ikuskapenak tokian bertan egingo dituzte langile teknikoek, eta, egoki irizten badiote, animalien laginak hartu ahal izango dituzte.

## Otsoaren erroldak

Eusko Jaurlaritzak eta foru aldundiek otsoaren erroldak egingo dituzte animaliaren populazioa ebaluatzeko eta irizpideak berrikusteko. Gutxienez, hamar urtean behin egingo ditu erroldak.

## Aurrekontua

Planaren urteko aurrekontua 480.000 eurokoa izango da. Diru sailaren erdia —220.000 euro— abeltzaintzarentzako laguntza profesionalerako izango da, boluntarioen programarako 20.000 euro erabiliko dira, ganaduari eragindako kalteengatiko konpentsazio ekonomikorako 50.000 euro, kalteak egiaztatzeko 55.000 euro, eta otsoari buruzko ikerketak eta ezagutza hobetzeko egitasmoentzat 65.000 euro. Euskadiko Otso Taldearentzat planaren helburu orokorrak onak dira, baina «asaldagarria» da «planak ez duela neurri ekonomiko zehatzik otsoa babesteko». ●



## Egoeraren diagnostikoa

**POPULAZIOA**
Azkeneko bi neguetan egindako jarraipenaren arabera, bi otso talde daude Araban eta Bizkaian: bata Arabaren eta Burgosen (Espainia) arteko mugan, bestea Bizkaia mendebaldean. 2007-2008ko urteetan lau talde ziren; 2018an eta 2019an, ordea, ez zuten otso talderik atzeman. Otsoaren egoerari buruz egin den azken errolda osoak —2019ko ugaltze urteari dagokiona— zehaztu zuen Arabako eremuaren %21,4an eta Bizkaikoaren %25,6an mugitzen zela.

**HERIOTZAK**
Araban, 1987tik 2007ra bitarte, 48 otso hil zituzten, «legezko kontrol ekintzen ondorioz, ibilgailuek harrapatuta edo legez kanpoko hilkortasunaren ondorioz». Bizkaian, hemezortzi. Geroztik ere hil dira eta hil dituzte otsoak, uxaldi baimenduetan batez ere. Isileko ehiza da otsoaren mehatxu nagusia..

**ELIKADURA**
2012an Arabako Foru Aldundiak otsoen 102 gorotz bildu eta aztertu zituen. Gorozkietan ikusi zuten ungulatuak zirela haien elikaduraren oinarria: gorozkien % 89,25etan agertu ziren. Ungulatuen artean, %56-58 basaungulatuak ziren (orkatzak, basurdeak, azeriak...) eta %42-44 etxekoak (ardiak eta behiak). Orkatza zuen bere elikagai nagusia (ia erdia), gorozkien arabera.

**ERASOAK**
2005 eta 2023 bitartean, Arabako eta Bizkaiko foru aldundiek 973 espediente izapidetu zituzten otsoek ganaduari egindako erasoengatik (635 Araban eta 338 Bizkaian). Batez beste 51,2 urtean. Hala ere, azkeneko bi urteetako kopuruak batezbestekotik gora daude: 2022an 110 izan ziren, eta iaz 82 (Araban 31 eta Bizkaian 51). 2022an 238 abere hil, zauritu edo desagertu ziren otsoen erasoen eraginez; iaz, 212. Eta 2005etik 2023rako datuen arabera, ardiak dira ia hamarretik bederatzi (%88).

# Osasun sistema publikoan lanbide karrera zabaltzeko legea onartu du Nafarroak



Fernando Dominguez Osasun kontseilaria, atzo, Nafarroako Parlamentuan. JESUS DIGES / EFE

- Neurriak 3.303 osasun langileri eraginen die.
- Legeari esker, sariak jasoko dituzte titulazioak lortzegatik edo ikerketagatik.
- LABek langile ez-sanitarioei ere hedatzea galdegin dio Nafarroako Gobernuari.



**Ion Orzaiz**

IRUÑEA— Osasun langileentzako karrera profesionala orokortu nahi du Nafarroako Gobernuak sare publikoan. Sindikatuen aspaldiko eskaera da, eta Nafarroako Parlamentuan atzo onartutako legeari esker, Osasun Departamentuko 3.303 profesionali ezarriko zaie: Osasunbideko C eta D mailako 3.259 langileri —A eta B mailakoei ezarria zieten jada— eta Nafarroako Osasun Publikoko eta Lan Osasuneko Institutuko 44ri. Onuradunen artean dira erizaintzako teknikari laguntzaileak, erradiodiagnostikoko eta farmaziako profesionalak, zeladoreak eta laborategiko langileak.

Lanbide karrera hedatzeari esker, sektore horietako langileek aukera izanen dute beren soldata hobetzeko eta formakuntza jasotzeko, zenbait faktoreren arabera. Baloratuko da, besteak beste, langileek postuan daramaten denbora eta ezarri zaizkien helburuak bete izana. Horrez gain, aintzat hartuko dituzte osasun titulazio espezifikoak, ikerketak egitea eta, kasuan-kasuan, euskara titulazioa izatea. Orain arte, A eta B mailako langileek soilik zuten horretarako aukera: fakultatiboek eta espezialistek, oro har.

Fernando Dominguez Osasun kontseilariak atzo parlamentuan esan zuen «hainbat hilabetez eginiko lan gogor baten emaitza» dela lege berria, eta «kontsentsuan» duela oinarria. Izan ere, iazko osasun greban, LAB eta UGT sindikatuekin adostutako helburuetako bat izan zen, hain zuzen, lanbide karrera zabaltzea eta horri oinarri juridikoa emanen dion lege bat ontzea. Hain zuzen, bi sindikatu horiek txalotu egin dute neurria, baina, C eta D mailako osasun langileei ez ezik, «osasun sistema publikoko langile guztiei ere ezartzeko» galdegin diote Nafarroako Gobernuari.

Dominguez kontseilariak onartu zuen legea «berandu» datorrela askorentzat, eta «neurri ausartagoak» eskatu dizkietela, eta prest azaldu zen lanbide karrera zabaltzen segitzeko: «Gobernuak dituen baliabideak mugatuak dira, eta horrek mantsoago lan egitera behartzen gaitu. Hortaz, legea berandu dator, baina lorpen handia da, langileentzako hobekuntzak dakartzan heinean. Lanean segituko dugu, gainerako profesionalak ere zerrendara gehitu ahal izateko».

### LABen elkarretaratzea

Parlamentuan osasun langileentzako lanbide karrera arautzen duen legea eztabaidatzen zuten bitartean, LABek elkarretaratzea egin zuen kanpoaldean. Sindikatu abertzaleak txalotu egin zuen legea onartu izana, eta «urrats historikotzat» jo zuen, baina Nafarroako Gobernuari galdegin zion neurria zabaldu dezala, langile ez-sanitarioei ere eragiteko.

«Osasun publikoaren sektorean azken hamarkadetan lortutako akordiorik onena» dela esan zuen Imanol Karrerak, LABeko Nafarroako bozeramaileak. «Mobilizazio eta grebei esker lortutako garaipena da, sindikatu batzuek kontrako jarrera erakutsi duten arren». Legeak ekarriko dituen onurei buruz, Karrerak esan zuen langileentzako «hobekuntza ekonomikoaz harago» doala neurria. «Langileek beren lanerako ezinbestekoa duten formakuntza jaso ahal izanen dute; gainera, lehen ez bezala, lege honek bermatuko du formakuntza eginen dela sare publikoan. Hori oso garrantzitsua da, orain arte, sindikatu jakin batzuen bitartez soilik jaso baitzitekeen».

Nafarroako Gobernuari eskatu dio lanbide karrera «are gehiago heda dezala», osasun langile ez diren funtzionarioak ere hartzeko. Karrerak iragarri zuen, ordea, «negoziazioak abian direla» jada sindikatuen eta administrazioaren artean, eta akordio zabalago bat espero dutela «urri bukaerarako edo azaro hasierarako».

Nafarroako Gobernua prestatzen ari den Osasun lege berriari buruz, LABeko ordezkariak esan zuen «datozen hilabeteetako erronka nagusia» dela, eta ez daudela pozik Osasun Departamentuak orain arte helarazi dizkien zirriborroekin: «Azterketa sakonago baten faltan, esan dezakegu gure balorazioa ez dela ona». Karreraren irudiko, osasun sistema publikoa indartzeko bide bakarra da legean jasotzea «langileen interesak eta gizartearen beharrak».

Azkenik, UGTk eta SAE erizainen sindikatuek ere txalotu egin zuten lanbide karrera hedatzeko legea onartu izana, eta iragarri zuten lanean segituko dutela «karrera profesionala beste eremu batzuetara zabaltzeko».●

# RACVNk helegitea jarriko du Bilboko emisio gutxiko eremuaren aurka

→ Uste du arautegiak mesede egiten diela «diru gehiago» dutenei.

→ Bilboko Udala «lasai» dago, legearen ondorio guztiak aztertu dituelako.

**Olatz Silva Rodrigo**

BILBO— EITBk jakinarazi duenez, RACVN Hego Euskal Herriko Automobil Klubak helegitea jarriko du Bilboko emisio gutxiko eremuaren kontra. Astelehenetik, guztiz indarrean dago arautegia; horrek esan nahi du hemendik aurrera isunak jarriko dizkietela Bilbo erdigunera sartzen diren auto kutsatzaileei.

Abuztuan iragarri zuen RACVNk helegitea aurkeztuko zuela, eta hala berretsi du orain. Mario Garcia klubeko bozeramaileak EITBri adierazi dionez, arautegiak «diru gehiago» duten horiei egiten die mesede: «Diru gehiago edo kaudimen handiagoa dutenek haien autoekin posible izango dute sartzea, eta trafiko gutxiago jasango dute, baina periferietan trafiko gehiago egongo da». Hori dela eta, epaitegietara jotzea erabaki dute.

Nora Abete Bilboko Mugikortasun zinegotziaren hitzak ere jaso ditu EITBk. Haren arabera, «lasai» daude, Bilbon «dena» aztertu baitute: «Inpaktu ekonomikoa, inpaktu soziala eta ingurumenean izango duen inpaktua; eskakizunak bete ditugu, eta, beraz, gu lasai gaude».

Donostian eta Irunen gauza bera egitea aztertzen ari da RACVN. Horretarako, baina, araudiak irakurri nahi dituzte lehenengo. Erabaki horren kontra agertu zen Eneko Goia Donostiako alkatea abuztuaren erdialdean; kritikatu egin zuen «oraindik indarrean ez dagoen» ordenantza bati helegitea jarri nahi izatea.

**Legea eta ordenantza**

Goiak argi utzi zuen emisio gutxiko eremu bat ezartzeko ordenantza bat onartuko dutela, 50.000 biztanletik gorako udalerri guztiei eragiten dien Espainiako lege batek hala behartzen dituelako. Hortaz, haren hitzetan, RACVNk «helegitea legeari» jarri beharko lioke lege horren aurka baldin badago, eta ez, ordea, ordenantzari. Are, salatu zuen RACVNren jarduna «bere interesek baldintzatzen» zutela; hau da, «aseguruen salmentak».

Adierazpen horiek «adarjotzetzat» jo zituen RACVNk. Automobil klubak onartu zuen legeak behartu egiten duela Donostia emisio gutxiko eremu bat ezartzera, baina erantsi zuen udalari dagokiola eremuaren irismena zehaztea, eta «nahikoa» litzatekeela Parte Zaharra emisio gutxiko eremu izendatzea. Neurri horrek «diskriminatu» egingo lituzke inguru horietan mugitzeko autoa erosteko baliabide nahikorik ez duten herritarrak. ●

## HITZ GUTXITAN

### Bizkaia, Solariaren goi tentsioko linearen kontra

**INGURUMENA**— Bizkaiko Foru Aldundiak Solariaren goi tentsioko argindar linearen kontrako txostena aurkeztu dio Eusko Jaurlaritzari, eremu babestuei eta espezieei eragingo liekeelako. Goi tentsioko linea horrek Solariaren eguzki parkeek Araban sortutako energia eramango luke Bilboko portura.

### Hamasei urteko kartzela eskaera bortxaketagatik

**INDARKERIA MATXISTA**— Gipuzkoako Fiskaltzak hamasei urte eta erdiko kartzela zigorra eskatuko du gizon batentzat, 2021ean 14 urteko neska bati lepotik heldu, zorabiatuarazi, eta gero bortxatzeagatik, Zumarragan (Gipuzkoa). Hurrengo astean epaituko dute, Gipuzkoako Auzitegian.

### Gidari bat atxilo istripua eragin eta ihes egiteagatik

IRUÑEA— Foruzaingoak 39 urteko gizon bat atxilotu zuen herenegun, furgonetarekin bi txirrindulari harrapatzea, ihes egitea eta drogen proban positibo ematea egotzita, Caparroson. Txirrindulari batek —21 urteko emakumea— hautsiak ditu hanka bat eta aldaka; besteak —62 urteko gizona—, berriz, hanka bat.




Kontseiluaren eta Bagera-ren protesta, atzo. KONTSEILUA

### Euskalgintza kexu da «azken hitza» epaitegiek dutelako hizkuntza politikan

DONOSTIA— Kontseiluak eta Bagera elkarteak elkarretaratzea egin dute Donostiako udaletxearen parean, eta kritikatu dute EAEko Justizia Auzitegi Nagusiak atzera bota dituela udaltzain izateko lan deialdi bateko hizkuntza eskakizunak. «Epairik epai, doktrina bat eratzen ari dira», salatu dute. «Gero eta handiagoa da euskararen aldeko politika publikoak egiteko zaitasuna».




Atzo arratsean egin zuten protesta. MONIKA DEL VALLE / FOKU

### Herritarrak kalean, Durangaldeko osasun publikoaren gabeziak salatzeko

**OSASUN ZERBITZUAK**— Durangaldeko zenbait herritan hilabeteak daramatzate mediku falta salatzen, eta eskualdeko manifestazioa egin zuten atzo, Berrizen (Bizkaia). Manifestazioaren deitzaileen esanetan, eskualdeko osasun etxeetan murrizketa handiak izan dituzte: bai arreta orduetan, bai mediku kopuruan. Bihar beste mobilizazio bat egingo dute, Zaldibarren.





**Pepita Zubillaga Etxaiz**



*ilargia hutsik dago*
*baina ilargi bete da*
*nahiz itzuli nahi genukeen*
*amonaren magalera*
*sentituko dugu sartu*
*ahala zure etxera*
*berriz biziko zarela*
*attonarekin batera*

**ETXEKOAK**

# EBko autogileek estu hartu dute Brusela emisio murrizketak atzeratu ditzan

→ Auto elektrikoen salmentaren beherakadaren ondorioz, 15.000 milioi euroko isun bati aurre egin behar diote datorren urtean.

→ Errekuntzako autoen debekua atzeratu eta 2035a baino aurrerago ezartzea nahi dute.

**Iker Aranburu**

Auto elektrikoa hedatzeko bidean bihurgune itxiak agertu zaizkio Europako Batasunari. Modelo elektrikoen salmenten gorakada eten egin da, eta merkatu kuota galtzen ari dira aurten, nagusiki prezio handien ondorioz. Moteltze horrek arriskuan jarri ditu Europako autogileen planak, eta milaka milioi euroren isunen atarian jarri ditu, elektriko gehiago saldu ezean ez baitira gai izango CO2 emisioen muga berriak betetzeko. Giro nahasi horretan, ACEA Europako autogileen patronalak Bruselaren gaineko presioa handitu du.

Atzo kaleratutako oharrean, ACEAk «premiazko neurriak» eskatu dizkio Europako Batzordeari. Hala egin ezean panorama beltza iragarri dute autogileek: «Milaka milioi askoren isunak ordaindu beharko ditugu agian, zero emisiorako trantsizioan erabili zitezkeenak; saihestu behareko ekoizpen murrizketak eta enplegu galerak etorriko dira, eta ahuldu egingo dira Europako hornikuntza eta balio katea, beste eskualde batzuen lehia zorrotza jasaten ari garen honetan».

Salmenten beherakadaren parte bat EBko autogileei beraiei lepora dakieke, ez baitira gai izan prezio apaleko autoak eskaintzeko kontinenteko kontsumitzaileei. Orain arteko modelo gehienak patrika zabaleko bezeroentzat izan dira; merkaturatu dituzten auto elektriko txikiagoek —Opel Corsa, Renault Megane eta enparauek— 30.000 eurotik gorako prezioa dute, eta ez daude eskuragarri herritar askorentzat. Aurtengorako iragarri zituzten 25.000 eurotik beherako autoak —Renault 5 berria eta Citroen eC3— atzeratu egin dira, eta atea ireki diete, horrela, Txinako auto merkeagoei.

Autogileen patronalak, ordea, ziurtatu du elektrifikaziorako bidean bere «partea» egiten ari dela; milaka milioi euro inbertitu dituela gogorarazi du, eta esan du bere egiten duela EBren helburua, errepide bidezko garraioa osorik 2050erako elektrifikatzekoa.

Bide horretan, bi mugarri igaro behar dituzte autogileek. Bata da 2025ean indarrean jartzekoak direla CO2 muga berriak. Horien arabera, autogileek gehienez 93,6 gramo CO2 isuri beharko dituzte saltzen duten auto berri bakoitzeko —2021ean baino %15 gutxiago—. Batezbesteko hori gainditzen dutenek isun handiak ordaindu beharko dituzte, eta horregatik eskatu du ACEAk muga berri horiek bi urtez atzeratzeko. Izan ere, gaur egun Volvo ez beste guztiek aise gainditzen dituzte muga horiek, auto elektrikoek pisu gutxi dutelako haien salmentetan.

Beste mugarria da 2035etik aurrera ezingo dutela EBn errekuntzako autorik saldu. 2026an du berrikustekoa arau hori EBk, baina ACEAk ziurtatu du ezin duela ordura arte itxaron. Arau horren aurkako ahotsak gero eta ozenago entzuten dira. Azkena, Giorgia Meloni Italiako lehen ministroarena.

**Muga zergak airean**

ACEAren agiriak ez dio ezer auto elektrikoen inguruan mahai gainean dagoen beste gaiari buruz: Txinako auto elektrikoen gaineko muga zergei buruz. Uztailean jarri zituen EBk indarrean behin-behinean, bere autogileak «lehia bidegabetik» babesteko. Muga zerga horiei buruzko iritzi kontrajarriak dituzte ACEAko kideek, haietako batzuek Txinan egiten dituzten auto elektrikoak saltzen baitituzte EBn ere.

Hain zuzen ere, gaiari buruz hitz egiteko bildu ziren atzo Valdis Dombrovskis Ekonomia komisarioa eta Wang Wentao Txinako Merkataritza ministroa. Pekinek eragotzi egin nahi du muga zerga gehigarriak behin betiko bilakatzea, eta ohartarazi du EBren beste produktu batzuei tarifa igoz erantzun dezakeela. Muga zerga horien aurka azaldu da Alemania, eta haren taldera ra batu da orain Espainia. Kontinenteko ekoizle handienetako bat da, kontinentearen ekialdea zabaldu aurretik Alemaniako eta Frantziako autogile handiek hara jo zutelako beren ekoizpena merkatzeko. Baina orain Txinako autogileak ari dira ate joka —Chery dagoeneko sartu da, Katalunian—, eta gehiago erakarri nahi ditu Espainiako Gobernuak. ●



15.000

**ISUNA.** 2025ean batez besteko isuriak %21 murrizten ez badituzte, autogileek 15.000 milioi euroko isun bat ordaindu beharko dute.

%14,4

**ELEKTRIKOEN KUOTA.** Abuztuan %20tik %14,4ra jaitsi da, baina kontuan hartu behar da iaz Alemaniako salmentak puztu egin zirela, laguntzak amaitzear zeudelako.




**MERCEDES, HANDITZEN.** Merkatuak oraindik erantzuten ez duen arren, Europako autogileak etorkizun elektrikorako prestatzen ari dira. Horien artean dago Gasteizko Mercedes —irudian—. 2026tik aurrera furgoneta elektrikoak egin nahi dituzte han, eta beste 100.000 metro koadro egokitzen ari dira horretarako. Atzo, Imanol Pradales Jaurlaritzako lehendakariaren bisita izan zuten. L.RICO / EFE



HITZ GUTXITAN

## Applek sistemak partekatu beharko ditu

BRUSELA— Europako Batzordeak iragarri du harremanetan jarriko dela Apple multinazionalarekin, hark iPhone eta iPad euskarrietako sistema operatiboak ireki eta lehiakideekin partekatu ditzan. Horrela, Bruselak MDA Merkatu Digitalen Araua bete nahi du: haren arabera, merkataritza elektronikoko enpresa handiek «doako eta benetako interoperabilitatea» bermatu behar diete lehiakideei, monopolio jarduerak galarazi eta merkatua orekatzeko asmoz.

Europako Batzordeak sei hilabeteko epea izango du, eta, tarte horretan, enpresari azalduko dio zer neurri hartu beharko lukeen legean jasotzen direnak betetzeko. Epe hori igarota Applek muzin egingo balie arauak ezarritako betebeharrei, Bruselak aukera izango luke isuna jartzeko.

DATUA



8

Joan den astean abiatutako greba zikloarekin jarraitzen dute Jaso Tower Craneseko langileek, zuzendaritzak zortzi langile kaleratu dituela salatzeko. Gaur ere ez dira lanera azalduko, eta manifestazioa egingo dute Idiazabalgo lantegitik herrigunera.

## Sant Briegeko parke eolikoa inauguratu dute

**INDUSTRIA**— Euskal Herriko industria eolikoa lanez hornitu duen parke eoliko handi bat inauguratu zuen atzo Iberdrolak, Sant Briegen (Bretainia). Siemens Gamesak egin ditu errotak, Haizea Windek dorreak eta Balenciaga ontziolak parkearen mantentze lanetarako baliatu duten *Goelo Enabler* itsasontzia.


Bi emakume Kandahar hirian, Afganistanen, joan den abuztuan. QUDRATULLAH RAZWAN / EFE

# Aditzen ez den ahotsaren bila

Andreen kontrako bertze lege bat ezarri dute Afganistanen: ezin izanen da haien ahotsik aditu leku publikoetan. Etorkizuna «beltz» ikusten du Khamox aktibistak.

**Iratxe Muxika Karrion**

Abuztuan hiru urte bete dira AEB Ameriketako Estatu Batuetako azken soldaduek Afganistandik alde egin eta talibanek herrialdeko boterea hartu zutenetik. Lehendik ere hasiak ziren lurraldeak hartzen, eta horietan arau murriztaileak jartzen. Abuztuan ezarri zuten lege horietan azkena, zeinak debekatzen baitu leku publikoetan emakumeen ahotsa aditzea. «Ez kantatu, ez hitz egin eta ez irakurri», dio telefonoz Hoda Khamox Afganistango aktibistak: «Ez dakit herri honek etorkizunik ote duen». Egoera ikusita, Khamoxek Emakumeen Justizia Mugimendua sortu zuen 2021eko irailean, nahiz eta lehenagotik hasia zen militantzian. «2014an, unibertsitatera joan nintzenean, jende asko ezagutu nuen, eta bidegabekeria asko bizi. Orduantxe hasi nintzen borrokan».

Gaur egun ere borrokan ari da, baina nondik borrokatu, horixe aldatu zaio, atzerrian bizi baita orain. «Kabulen [Afganistan] borrokarako taldeak sortu eta hainbat manifestazio egin ondotik, Nazio Batuen Erakundean sartzeko aukera izan nuen, ordezkari gisa». 2022ko urtarrilean, NBEk Afganistango egoerari buruzko bilera bat egin zuen Oslon, eta hara joateko gonbita egin zioten Khamoxi; talibanekin batu zen han. «Bilera hartan, talibanek gezur handiak esan zituzten, eta nik protesta egin nuen. Mehatxu egin zidaten, eta gure familia arriskuan jarri. Norvegian geratu behar izan nuen». 2022ko abendutik bizi da han, etxetik eta familiakoengandik urrun, baina haiek aske izateko lanean.

Iranen jaio zen Khamox, 1996an. 2001eko abenduan, AEBek talibanak boteretik kendu zituztenean, Afganistanera itzuli ziren, familia hangoa dute eta. Hogei urtez izan ziren AEBetako tropak Afganistanen, baina, 2021. urtean, talibanek boterea hartu ondotik, bizimodua aldatu egin zitzaien Khamoxi eta lurraldeko emakume guztiei. Talibanek muturreko islam politikoa dute oinarri, eta emakumeak jartzen dituzte jomugan.

Gaur-gaurkoz, Afganistanen bizi diren emakumeek ezin dute lanik egin, 12 urtetik aitzinera ezin dute ikasi, ezin diete gizonei begietara begiratu senidea edo senarra izan ezean, ezin dute garraio publikoa erabili gizonik ez badute lagun, ezin dute gidatu eta ezin dute gorputz atalik bistan utzi, bertzeak bertze. Etxe barrenean konfinatuta bizi dira; ahal dela, kaleko izpiei zirrikiturik ireki gabe.

Ongi oroitzen du Khamoxek etorkizuna «beltzu» zitzaien eguna, 2021eko abuztuan talibanak indarrez sartu eta handik zenbait egunera: «Egun beldurgarria izan zen. Kalera ateratzeko prestatzen ari nintzenean, senarrak telefonoz deitu zidan. Erran zidan ateak eta leihoak ixteko, eta, mesedez, ez ateratzeko etxetik. Talibanak Kabulera iritsi, eta indarrez hartu zuten hiriaren kontrola, armak erabilita». Aktibistak oroitzen du bat-batean zeharo aldatu zitzaiola irudia hiriari, eta tiro hotsak hastearekin batera argiak itzali egin zirela. «Ez dira berriz piztu, ordea».



«Etxean izanen banintz ezin izanen nuke halako borrokarik egin; kanpoan egoteak horretarako balio dezala»

**HODA KHAMOX**
Aktibista afganiarra

**Lehen, «bizitza ona»**

Telefonoz solastatzen da Khamox Afganistanen bizi diren lagunekin eta familiarekin, eta aitortu du «oso zaila» egiten zaiola haiek egoera hartan ikustea. Familia «borrokalaria» du Khamoxek, injustizien kontra ahotsa altxatzen duten horietakoa. «Guztiok aritzen ginen giza eskubideen alde lanean, bai talibanak iritsi aurretik, baita gero ere».

Afganistanen du familia, eta maiz egiten dituzte telefono deiak, «arduraz» bizi dute-eta bata bertzearen egoera. «Gure familia, han egonda ere, talibanen kontra egiten ari da oraindik, ahal den neurrian». Khamoxek, ordea, atzerritik egin behar: «Etxean izanen banintz ezin izanen nuke halako borrokarik egin, eta, behintzat, kanpoan egoteak horretarako balio dezala». Ezagutzen ditu borrokatzera ateratzeagatik edo begiak erakusteagatik larriki zigortu dituztenak, kasurako. «Zigorrak irudikatu ezinezkoak dira». Azaltzea ere zaila egin zaion arren, hala kontatu du Khamoxek: «Emakume asko bere buruaz beste egiten ari dira egoera jasangaitza delako».

Talibanek boterea hartu aitzinetik, «bizitza ona, normala» zuen, ikasketak eginak baitzituen, lanbide bat baitzuen eta askatasunez mugitzen baitzen alde batetik bertzera. «Orain ezinezkoa iruditzen zaigun arren, lehen bagenuen eskubidea bizitzeko eta arnasa hartzeko». Egoera aldatu zenean, kalera atera ziren protesta egitera, 2021eko irailaren 3an. «Jipoiak eta tiroak, besterik ez genuen hartu», oroitu du.

Etorkizunera begira, erantzunik gabe geratu da Khamox: «Ez dakit zer pentsatu, ez dakit etorkizunik ere izanen ote den. Negargura sartzen zait». Bide zuzenik ikusten ez badu ere, argi du borrokan jarraituko duela, eta bidegabekerien aurka oihu egin. «Sare sozialetan emakumeon aldeko aldarria egiten dut; adibidez, kalean hitz egitea galarazi diguten honetan, neure burua kantatzen grabatu, eta zabaldu egin dut». ●

# Ukrainako energia sareari erasotzeak zuzenbide humanitarioa urratu dezake

→ NBEren agentzia baten arabera, arrazoiak daude pentsatzeko Errusiak nazioarteko zuzenbide humanitarioa urratu duela energia azpiegiturei eraso eginda.

**Aitor Garmendia Etxeberria**

Martxotik behin eta berriz egin die eraso Errusiako armadak Ukrainako elektrizitate azpiegiturei. Horrek «kalte eta estutasun handiak» eragin dizkie Ukrainako herritarrei, Ukrainan Giza Eskubideak Behatzeko Nazio Batuen Misioaren arabera. Gainera, negua iristean eraso horien ondorioak «suntsitzaileak» izan daitezkeela jakinarazi dute. Atzo argitaratu zuen NBEren agentziak gai horren inguruko txostena, eta ondorioztatu zuen balitekeela Errusia nazioarteko zuzenbide humanitarioa urratzen aritzea.

Ukrainako energia azpiegituren aurkako bederatzi eraso olde zenbatu ditu NBEren misioak iragan martxotik irailera arte. Erasoak misilekin eta droneekin egin dituzte, eta kaltetutako azpiegituren artean daude eguzki zentralak, zentral termikoak eta zentral hidroelektrikoak.

Txostenaren arabera, erasoek arriskuan jarri dituzte ukrainarren oinarrizko zerbitzuak, hala nola uraren banaketa, estolderia sistemak, berogailuak eta ur beroa, osasun publikoa, hezkuntza eta ekonomia. NBEren agentziak ohartarazi du egoerak okerrera egingo duela neguan. Horren inguruan hitz egiteko, Europako Batzordeko presidente Ursula von der Leyen Ukrainako presidente Volodimir Zelenskirekin batzekoa da gaur. Atzo adierazi zuen Europako Batasunak Ukrainari laguntza ematen jarraitu behar duela energiaren arloan.


Ukrainako azpiegituren aurkako eraso bat, martxoan. S. KOZLOV / EFE

Moskuk jakinarazi zuen atzo Ukrainako bi drone suntsitu zituela Kursk eskualdean. Iragan abuztuaren hasieran erasoaldi bat hasi zuen Ukrainak Errusiako lurralde horretan. Zenbait herri hartu zituen Ukrainako armadak, baina Errusia berriz ere kontrola berreskuratzen ari da. Aurrez Ukrainako militarrek harturiko bi herri berreskuratu dituzte azken egunetan, Moskuk dioenez.●

## ‘Boris’-ek ebakuazioak eragin ditu Italian

ERROMA— Italia ere *Boris* denboralearen ondorioak nozitzen hasi da. Iturri ofizialen arabera, ez du biktimarik eragin, baina Emilia-Romagna eskualdean, herrialdearen erdialdean, esaterako, 1.000 herritar baino gehiago ebakuatu behar izan zituzten atzo, ur maila igo zelako. Luizi batzuk ere izan ziren, eta trafikoari eragin zioten.

## Europarlamentuak Gonzalez aitortu du presidente gisa

BRUSELA— Europako Parlamentuak Venezuelako presidente hautatu gisa aitortu zuen atzo Edmundo Gonzalez. Oposizioaren hautagaia presidente moduan onartzearen alde bozkatu dute Europako Alderdi Popularrak eta eskuin muturreko bi taldeek. Liberalek ez dute parte hartu bozketan, eskuin muturraren aurkako babes hesi moduan.




# Iritzia

## Irudiak



**HITZ ETZANAK**
Andoni Egaña

Veni, vidi, vici», esan zuen Julio Zesarrek borrokaldi bat aitaren batean erabaki ondoren; «Atzo genioen bezala...», bota zuen Frai Luis Leongoak, bost urteko kartzelaldiaren ondoren, Salamancako Unibertsitatean berriz ere eskolak ematen hasi zenean; «Oso latza izan da», esan zien Joxe Arregik kideei, torturapeko egun luzeen ondoren, ziega batera eraman zutenean. Hitz batzuk, esaldiren batzuk, betirako geratzen dira.

Baina Henrik Ibsen antzerkigile eta poeta norvegiarrak XX. mendearen atarian bota zuen irudi bakarrak mila hitzek baino esanindar handiagoa duela, eta, egungoari begira, bete-betean asmatu zuela aitortu beharko da. Aste honetako marea biziei begira jarri baino ez dago. Guztioi heldu zaizkigu itsasbeherek eta itsasgorek sorturiko irudiak. Guztioi. Eta horrek badu alderdi makur bat. Ezin kontatua. «Ikusi al dituzue Zumaiako irudiak?». «Bai». Eta kito. Hor bukatzen dira ahozko jarduna, kontatzailearen enfasia eta entzulearen irudimena.

Irudirik ez zen garaietan, bazen Zumaian bertan esaera bat, marinelei eta itsas mareei lotua. Iritsi dira portura bueltan arrantzaleak. Baina marea nonbait oso behean, barran geratu behar herrira noiz sartuko. «Urik balego ardoa edango; eta urik ez dagoelako ura edan behar», bota zuen arrantzale batek. Beti iruditu izan zait eskola-umeei jartzeko moduko igarkizuna. Hitz soilak... ●

## Elon eta gu



**LARREPETIT**
Ander Perez Argote

Uda honetan jakin duzu *Starlink* izena daramala Elon Muskek espaziora jaurtitako satelite multzoak. Musk nor den orain dela pare bat urte-edo jakingo zenuen, Twitter erosi zuela jakin zenuen momentu bertsuan. Eta hala, jakiten zoaz jakin gabe ere ederki biziko zinatekeen gauzak, eta ezagutzen ezagutu nahiko ez zenituzkeen pertsona ankerrak.

Kontua da uda honetan izan duzula Elon Musken satelite ilararen berri, berez izar uxoak ikusteko gaua zenaren erdian *trena* ikusi duela esaten esnatu delako adiskidea, Esloveniako erreka bazter batean. Eta hala, bizikleta gainean bidaiatzeak buruari buelta asko emateko balio duenez, pentsamendu bat beste batekin kateatzen hasi zara, pentsatzen bukatzeko ea norengandik zauden gertuago zu, munduan diru gehien duenarengandik —*aka*, Elon Musk—, edo, kontrara, gutxien duenarengandik.

Eta ez da galdera erraza, ustez hala badirudi ere. Zeren eta baliteke, aberastasun maila batetik gora, kapritxoak (eta zorakeriak) besterik ez bereiztea milioiduna eta soldata duin samar bat duen langile pobrea, eta beraz, gertuago egotea Muskengandik munduko pobreenetik baino, egunero esnatu eta behar oinarrizkoenak aseta sentitzeari dagokionez.

Baina horrek ez du esan nahi, materialki, amildegi batek —eta kontu korronteko hamarnaka zero batzuek— ez gaituztenik bereizten Elon Musk eta gu, eta hortaz, zapaldu eta zapaltzaileen arteko marran, alde banatan kokatzen ez garenik egunero gure lan indarra beste batzuei saltzen diogunak eta aberaskilo zoroak.

Gero irakurtzen duzu CISen arabera immigrazioa Espainiako Estatuko herritarren lehen kezka dela, eta ikusten duzu ezetz, zapalduenekin berdindu ordez besteekin berdindu nahi gaituztela, eta mamu-etsaiak eraiki. Gure arazo gehienak askoz urrutiago, espazioan bezain urruti bueltaka dabiltzanen ardura ez balira bezala. ●

## *Barne kontsumoko subiranismoa?*



**DERRADAN, BIDENABAR**
Martxelo Otamendi

Erakunde legegileek *nazioaren egoeraren* eztabaidarekin hasten dute urte politikoa. Gurean, legebiltzarretan eta aldundietan egiten dute, beste modu batera esanda, *politika orokorrari* buruzko eztabaida... Irailean izaten da, eta gobernuburuak hasi berria den urte politikoko lerro nagusiak azaltzen ditu, oposizioaren kritikapean. Ohikoa da erakundeburuaren mezuak bi alde edukitzea: praktikoa, jateko kontuak, eta ideologikoa.

Gipuzkoako ahaldun nagusi Eider Mendozak, asteazkeneko mintzaldiaren parte ideologikoan, erabakitzeko eskubidearen defentsa egiteaz gain «instituzionalizatzea» proposatu zuen. Alegia, denok ulertzeko moduan esanda, halako batean berrituko den Autonomia Estatutuak eskubide hori bermatu beharko lukeela. Bere gobernukide sozialistek, asko larritu gabe, gutxietsi egin dute Mendozaren proposamena, *jeltzaleen matraka* dela pentsatzen duenaren aurpegia jarrita.

Norekin dauka asmoa Mendozak eskubide horren aldeko lana egiteko, hauteskundeak irabazi ez eta erakundearen lehendakaritza era legitimoan hartzen lagundu diotenekin, hau da, PSErekin eta PPrekin? Edo EH Bildurekin, hauteskundeak irabazi zituen eta eskubide horren alde egiten duen taldearekin? Bigarren aukeran, orain Gipuzkoako Batzar Nagusietan dagoen baino gehiengo handiagoa bilduko lukete.

Norentzat zen Mendoza subiranistaren mezua, Gipuzkoako herritarrentzat edo alderdiarentzat, hau da, barne kontsumorako? ●

# Bastoak agintzen du

Sabino Cuadra Lasarte
Abokatua

Europan bastoak agintzen du. SIPRIren arabera (Stockholmgo Bakea Ikertzeko Nazioarteko Institutua), 2023an, gastu militarra %16 hazi zen Europan 2022koarekin alderatuta, eta 552.000 milioi eurora iritsi. 2024ko datuak oraindik jakin gabe, ez du irudi joera hori moteldu denik, kontrakoa baizik, Ukrainako gerra dela kausa. Hori hala izanagatik ere, Europako Batzordeak, NATOk joan den uztaileko gailurrean finkatutako urratsari jarraikiz, kopuru hori modu garrantzizkoan emendatzen jarraitzeko hautua egin du.

Espainiako Estatuan, Defentsako aurrekontua %60,8 igo zen 2012tik 2022ra. Gutxi izan balitz bezala, 2023an jauzi ikusgarria egin zuen, %26 areagotuta. Horri gehitu behar izan zitzaion %38ko soldata igoera Polizia eta Guardia Zibilarendako. Hemendik gutxira jakinen ditugu 2024an izandako gastuak eta 2025erako Aurrekontu proiektua, baina beldurra ematen digute.

Horrek guztiak zerikusia du Pedro Sanchezek hartutako konpromisoarekin, hots, NATOk erabakitakoari men egitea eta aurrekontu militar espainiarra urtez urte emendatzea, 2029an Barne Produktu Gordinaren (BPG) %2ra iritsi arte. Dena den, erran dezagun kontu-sail militarrak direla, diferentziaz, opakutasun eta marro mailarik handiena aurkezten dutenak aurrekontu orokorren barnean. Eta hori hala da zeren eta Defentsa ministerioari esleitutako zenbatekoa hark zuzenean kudeatzen duen kopuruari bakarrik baitagokio. Bertze gastu aunitz gehiago egoten dira bertze ministerioetako kontu-sailetan ezkutaturik.

Hala, adibidez, Ekonomia ministerioak armen erosketak eragindako aparteko kredituak eta zorra kitatzeko kontu-sailak ditu, izaera militar nabarmena dutenak. Bertze sail garrantzizkoa mundu militarraren pentsioek eta osasun prestazioek osatzen dute, Defentsaren aurrekontuan sarturik ez daudenek. Edo industria militarrari dagozkion pizgarriak, kredituak eta ordainketak, Ogasun ministerioari edo Industria, Zientzia eta Teknologiakoari esleituak. Defentsak ez du kanpoan egindako operazio militarren gastua ere biltzen, ezta nazioarteko erakunde militarrei ordaindutako kuotak edo enbaxadetako agregatutzak ere.

Horregatik, maila ofizialean gastu militarra, egun, BPG espainiarraren %1,28 dela erraten badute ere, errealitatea da portzentaje hori baina hagitz handiagoa dela. Gauzak horrela, 2023an Defentsa espainiarraren aurrekontu ofizialak 12.827 milioi euro egin bazuen ere, SIPRIk 27.617 milioi eurotan finkatu zuen benetako gastua, hau da, BPGaren %2,15, eta horrek aise gainditzen du NATOk 2029rako finkatutako %2ko helburua.

Kopuruekin maltzurki jokatzearen xedea argia da. Egiten ari diren areagotzeak justifikatu nahi dituzte, parte-hartze espainiarra NATOren aurrekontuetan bere partaideen artetik baxuena dela argudiatuta. Eta, aldi berean, neurrigabeko gastu baten errealitatea ezkutatzen dute, herriaren begikotasun handirik ez baitu. Gastu horrek 121.000 kideko armada elikatzen du, agintariak eta soldaduak baturik, ratio hipertrofiatua duena: agintari bat 1,27 soldaduko. Eta horiei 76.642 guardia zibil gehiago gehitu behar zaizkie. Frankismoaren oinordekoa den armada, aldian-aldian zornatzen dituena ehunka koronel, jeneral, fragata-kapitainek eta bertzek sinatutako agiriak eta eskutitzak Francisco Franco entzutetsuaren bertuteak eta mirakuluak laudatuz.

Bertze aldetik, gastu militarrek badute zerikusia aberriko industria militarra elikatzen duen gerraren eta heriotzaren negozioarekin. Espainiako Estatuak bere ekonomia munduko hamalaugarren tokian badu ere, armak esportatzeko orduan zortzigarren tokian dago (Saudi Arabia eta Golkoko lurraldeak, Maroko, Ukraina, Filipinak, Israel, Mali...) eta aurrekontu publikoek erabat babestu eta diruz lagundutako ekoizpena eta merkataritza ditu.

Nahiz eta Israel Gazan eta Zisjordanian genozidioa gauzatzen ari den, lurralde horren eta Espainiaren arteko hartu-eman militarrek ez dute funtsean aldatu. Espainiako Gobernuak Israelgo esportazioak eten dituela erran badu ere («eten», ez «ezeztatu»), 2023ko urriaren 7a baino lehenago onetsitakoak mantendu dira. Azpimarratzekoa ere Espainian fabrikatutako defentsa materialaren zati handiak patente israeldarra duela edo filial israeldarrek egiten dutela, bi lurraldeen artean teknologia eta segurtasuna transferitzeko dauden akordio garrantzizkoez gain. Horretaz aparte, Navantia (Ferrol) ontzi-enpresako CGTk salatu du *Kristobal Kolon* fragata berriki abiatu dela hiri horretatik Israelen operazioak babesten dituzten NATOren taldeetako batean integratzeko Gaza inguruan.

Horrengatik guztiagatik, 600 GKEk (Oxfam, Munduko Medikuak, Unicef, Gurutze Gorria, Elkartasun Aliantza...) izugarrizko zentzugabekeriatzat jo dute EBren gastu militarraren gehikuntza. Aitzitik, berresten dute gerra apustu hori hausteko beharra eta bertze baten alde egitekoa, giza eskubideetan, demokrazian, garapen jasangarrian eta gatazken irtenbide baketsuan eta negoziatuan oinarritua.

Bukatuko dut. Gobernuak iragarri du heldu diren asteetan aurkeztuko duela 2025erako Aurrekontuen zirriborroa. Erraten dute antz gutxi izanen dutela aurreko urtekoekin. Ukrainako gerraren eta Gazako genozidioaren ondorioek, eta aurrekontu-egonkortasun europarraren arau fiskalak berriro indarrean sartzeak dudazko etorkizun goibela iragartzen dute. Nolanahi ere, apustua egin daiteke gastu militarrek nabarmenki areagotzen segituko dutela, Pedro Sanchezek horretarako konpromisoa hartu baitu. Bada, panorama honen aitzinean, zer eginen dute gobernu hau, «Espainiako historia guztian aurrerakoiena» deitutakoa, sostengatzen duten erakundeek? Gaitz erdi liratekeelakoan onartuko dituzte aurrekontu horiek edo, bertzelako kritikak baztertu gabe, izanen dira kontu-sail militarista horiek marra gorri onartezin bat? Agudo jakinen dugu. ●

# 'Hit'-a



**JIRA**
Maialen Akizu

Egun berean iragarri dute erretiroa Chill Mafia eta Gatibu taldeek. Leherketa handiagoak izan dira munduan, baina «eztanda», «astindua», «bonba bat» aipatzen dugu zerbait izugarria bezain positiboa azpimarratzeko. Gatiburen hasieraz ez daukat akordurik. Betizuren «behera, behera, behera, behera je, je, je» kantatzetik *Musturrek sartunde* abestira praka piratetatik bakeroetara besteko tartea dago niretzat. Haurrak ginen eta ulertzen ez genuen kantu hura gustatu zitzaigun. Chill Mafiaren hasiera, aldiz, ulertu egin nahi nuen; are, ikertzea ere pentsatu nuen: zergatik eurak, zergatik orain, zergatik kanta horrekin. Twitter iritziz bete zen, tonu erasokorrez, teoriaz, gizonez; iraultzaz hitz egin zen, folkloreaz, soziolinguismoaz.

Gatibu eta Chill Mafiaren arteko diferentziak nabariak dira, eta antzekotasunak ere badituzte. Besteak beste, biek ala biek abesti «apurtzaile» batekin egin zuten salto musikaren zirkuitura. 'Hit' ala hil. Nik sinisten dut barrura sartzeko ez dela derrigor atea ostikoz bota behar; irten daitekeela danbatekorik eman gabe. ●

# Zergatik ez?



**BIRA**
Onintza Enbeita

Gazako irudiak ezin ditut ikusi. Ez daukat barruan horrorerako leku gehiago. Ezin dut ume hil gehiago ikusi oka egin gabe, eta ez naiz zentzu figuratiboan ari. Ezin dut gehiago. Amorrua ematen dit munduaren utzikeriak, amorrua AEBen zinismoak, nazka Europak, ernegua Hamasez ari direnek eta nekea «israeldar guztiak ez» esaten didatenek. Ez dezagun ahaztu euren burua israeldartzat daukatenak munduko beste leku batzuetatik joan zirela hara helburu argi batekin: euren ustezko arraza eta erlijio ederrarentzat nazio bat sortzea. Berdin zaie noren gainetik pasatu horretarako. Lurrak ostu, etxeak okupatu, jendea hil, torturatu, bortxatu... Eta kamera bat aurrean jartzen zaien aldiro lasai esaten dute Jainkoak aukeratutako herria direla. Gero, pizten dituzu Europako telebista kateak eta arabiarren fanatismoaz hitz egiten dizute bakarrik.

Palestinaren kontrako genozidioa aspaldi hasi zuten sionistek, eta orain Libanora ere ba ei doaz. Zergatik ez? Orain arte egin duten guztia eginda, munduak ez badu ezer egin, zergatik egingo du orain? ●

BERRIA **Zuzendaria:** Amagoia Mujika Tolaretxipi **Zuzendariordea:** Eider Goenaga Lizaso
**Edizio arduraduna:** Idurre Lazkano **Argitaratzailea:** Euskal Editorea SM
**Publizitatea:** Bidera publizitatea **Lege gordailua:** SS-0662/03 **Batzorde parekidea:** 0722/84059
**Egoitza nagusia:** Martin Ugalde kultur parkea. Gudarien Etorbidea, z/g 20140 Andoain
**Telefonoa:** (0034) 943-30 40 30 **Webgunea:** www.berria.eus **Posta elektronikoa:** berria@berria.eus
**Publizitatea:** publi@bidera.eus **Harpidetza saila:** (0034) 943-30 43 45 **Date:** 20/09/2024
**Exemplaire:** 6.601 **Editeur:** Euskal Editorea SL **Directeur de publication:** Amagoia Mujika Tolaretxipi

**Comission paritaire:** 0924 C 84059 **Delegation Labourd:** Lisses 3, 64100 Baiona (0033) 559-256220. lapurdi@berria.eus
**Ordezkaritzak | Araba:** Bizenta Mogel, 6. 01008 Gasteiz. (0034) 945-15 04 52. araba@berria.eus **| Bizkaia:** Uribitarte kale 18, 3C, 48001 Bilbo. (0034) 94-435 26 00. bizkaia@berria.eus **| Lapurdi:** Lisses 3, 64100 Baiona. (0033) 559-25 62 20. lapurdi@berria.eus **| Nafarroa:** Iratxeko Monasterioa 45, 13. 31011 Iruñea. (0034) 948-36 66 22. nafarroa@berria.eus

# Sekulako zaparrada



**ARKUPEAN**
Oihana Arana

Udazkenari etxeko leihoak ixtea ahaztu zitzaion pasa den astean. Asteazkenean nabaritu nuen bereziki. Ez nengoen oso triste, baina apur bat bai. Trenetik irten eta euria. Ez euri apur bat. Sekulako zaparrada. Aterkinik gabe ni. Kanta tristeen zerrenda bat aukeratu nuen Spotifyn. Korrika egin gabe, baina presaka egin nituen etxera arte neuzkan hogei minutuak hamazazpi minutuan edo. Arropak erantzi, musika itzali eta negar apur bat egin nuen ohe gainean. Ileko hezetasunak busti zidan burkoa, ez dut uste horrenbeste malko isuri nuenik. Euririk ez balitz beste gorputzaldi batekin egin izango nukeen bidea, apur bat pozik egoten saiatzen. Euririk ez balitz Hiru Trukuren diskoren batekin egin izango nukeen bidea, kopla doinuak kantatzen. Baina euria zen, ez euri apur bat. Sekulako zaparrada.

Treneko bidaia gehiegi erromantizatu izateagatik zeruko izakiren bat ni zigortzen ari zela pentsatu nuen momentu batez. Aurpegia goratu nuen zeruari keinu maltzur batekin erantzuteko. Aurpegia bustita egin behar izan nuen gainontzeko bidea. Ez da nire kulpa treneko bidaiak horrenbeste erromantitzatzea; Anarirena edo Gorka Urbizurena izango da, gutxienez. Gainera, puntual iristen da beti, euskotrenaz ari naiz, noski. Eta batere zorabiatu gabe irakur dezaket bertan, baita bizkarrez joanda ere. Ez dira argudio gehiegi behar autobusaren aldean trena aukera hobea dela esateko, baina tira egia da posible dela trenak perfektuak ez izatea ere. Oraindik ez dut hori guztiz asumitu, baina ez da nire kulpa, AHT-a amaitzen duten arte, trenek gurutzatzen ez duten eskualde batean jaio nintzen. Badago trenbidea deitzen zaion bidegorri bat, baina hori bakarrik. Nerabezaroa autobusaren zain pasatzen da Debagoienean. Eta sekula izan ez dugun horren bila pasatzen omen dugu bizitza gizakiok, edo hori sinetsarazi digute gauzak saldu nahi dituztenek behintzat.

Autobusaren zain pasatu genuen guk ere nerabezaroa. 2015eko Gipuzkoako Bertsolari Txapelketako saioak ikusteko, autobusean zeharkatu genuen Gipuzkoa udazkeneko asteburu guztietan. Beasainera joateko hiru autobus, Oreretara joateko beste hiru, Azpeitira joateko beste hiru... Gurasoek ere eramaten gintuzten askotan, eta egin zituzten auto bidaia horiek guztiak klabeak izan ziren gure bertsozaletasuna eraikitzeko, baina errituelaren parte izaten ziren autobus bidaia horiek ere. Bederatzi urte pasatu dira eta heldu da guk horrenbeste animatzen genituen horiekin oholtza konpartituko dugun txapelketa. Ekarriko dizkigu pozak eta penak. Beti bezala. Denak bezala.

Baina hasi aurretik eman zigun poz bat guri (pluralean ari naiz testu honekin identifikatuta sentituko den pertsonaren bat edo beste badagoela uste dudalako): txapelketaren aurkezpena gure jaioterrian, Eskoriatzan, egin zen, Apotzaga auzoan. Poza eman zidan berri horrek: umetan askotan joaten ginen bertara, aitak eramaten gintuen. Eta ez dakit, neure baitarako erritual txiki bat egiteko aitzakia eman zidan egoerak. Poza ez zidan horrek bakarrik eman, noski. Inportantea iruditzen zait espazio hori aldarrikatzea, Almeneko bertso-eskolaren sorreratik mende erdia igaro den honetan zentzuzko erabakia iruditu zitzaidan; beharrezkoa ere bai. Gurean ere bada itzalpean lan handia egindako jendea. Behin eta berriz omentzeko modukoa.

> Ez da nire kulpa treneko bidaiak horrenbeste erromantitzatzea; Anarirena edo Gorka Urbizurena izango da, gutxienez

Ez dut ukatuko gure herrian horrenbeste bertsolarirekin egotea arraroa egin ez zitzaidanik, baina ilusioa ere egin zidan. Beti izan dugu leku guztietatik urruti gaudelako sentsazioa, besteen herriak gure herritik gurea haienetik bezain urruti egongo ez balira bezala. Besteek gure herrira etortzeko hiru autobus edo gutxienez tren bat eta bi autobus hartu beharko ez balituzte bezala.

Aurtengo txapelketako saioetara trenean joaten ahaleginduko naiz, bidea erromantizatzeak eta, batez ere, ez zorabiatzeak bidea erraztuko didatelakoan. Ea ez gaituen aldiro euri zaparradak harrapatzen. ●

# Adinkeria

**Adur Lizasoain**
Pilotazalea

Hemezortzi urte besterik ez zituen nire lagun bati, bizarduna eta lodia bera, «*señor*» deitu zioten lehen aldian; nola ez, ez da itzuli berriz denda hartara. Udaberri dezente gehiago, bestetik, Anthony Hopkinsen pertsonaiak *Conocerás al hombre de tus sueños* komedia ederrean (Woody Allen, 2010) ero baten moduan pisuak altxatzen zebilenean, heriotzari beldurra diola eta bere zahartze prozesua atzeratu nahian.

Adina zenbaki bat besterik ez dela, jarrera kontu bat, esan ohi dugu gurean amodio harremanetan edo gustatzen zaizkigun plan horiek egiterakoan, justifikazio gisa; pilotariek profesional zirkuituranzko jauzia egiterakoan, aldiz, ez dute iritzi bera izan azken urteotan Aspek eta Baikok. Ander Muruak (Arrasate, 2000) debuta egin berri du. Azken bizpahiru urteotan bera izan da bere postuan onena afizionatuen zirkuituan, eta errendimendua eta meritokrazia ardatz, merezi zuen aukera hau zalantzarik gabe. Bejondeiola, eta disfruta dezala bideaz. Duela hilabete batzuk, bestalde, Joseba Aldaberen (Igantzi, 1996) txanda izan zen. 27 urterekin, jada trena pasatu zitzaiola onartua zuenean egokitu zitzaion aukera atzelari honi, elektrikaria ofizioz, afizionatuetan sekulako maila eman ostean —urte bat baino gehiago zihoan partidarik galdu gabe—. Zeresana eman zuen albisteak prentsan, debuta 18-21 urte bitartekoek egitearen tonika hautsi zuen eta. Hortik gorakoek, jada, jai. Eta normalizatua genuen.

Gogoan dut hain justu Muruaren debuteko pilotalekuan jokatu nuen aldi bakarra: 22-3 galdu nuen, 80 kilometroko bidaia egin ostean. Isil-isilik itzuli ginen autoan aita eta biok takoak kentzen nituen bitartean. Ni txarra nintzen —eta ez zenuten jokatzen ikusi egun hartako nire bikotekidea—, beraz ez da ezer gertatzen, baina badaude talentuaz gain zaletasun handia eta profesionala izateko ametsa duten pilotari gaztetxoak. Ez ditut sekula ahaztuko Iñigo Martínezen (Bera, 1997) eta Beñat Garmendiaren (Beasain, 1997) —afizionatuetan ederki dabil orain— kasuak, bi urteren buruan kontratua berritu gabe geratuak biak errendimendu txukuna eman eta potentzial pixka bat behintzat bazutela erakutsi ostean, edo Jon Erasunena (Zizurkil, 1996), hamalau egun lehenago eta gauez jakinarazia agurraz Whatsapp mezu hotz baten bidez. 2020an Baikon izandako greba zaratatsu hartaz nahiago dut ezer ez idatzi, nahikoak esan ziren-eta bere garaian. Pixka bat mingarria izan zen hura zaleontzat.

Gure herrietako pilotalekuak haurrez gero eta hutsago dauden eta Boliviatik bi mutil propio pilotan jokatzera etortzen diren garai honetan, paradoxikoa oso, uste dut gehiago zaindu behar direla pilotariak eta ez direla haien ametsak horren azkar hautsi behar. Ez du zentzurik talentu pixka bat baduen eta berez kantxan zer eskaini eta zer disfrutatu baduen 22 urteko mutil bat jada erretiratuta, agortuta, pilarik gabe geratu den panpina zahar bat bezala egotea. Ilusioa galtzea, pilotaz deus ez jakin nahi izateraino, beharbada, kasu batzuetan. Horrela ez ditugu erakarriko hurrengo belaunaldiak, eta horren errua ezingo diogu bota futbolari edo bideojokoei.

Gehiago baloratu beharko genuke haien gurasoek urteetan eginiko sakrifizioa ere, kilometro mordo bat eginez Euskal Herrian barrena eta materiala erosiz, dena beren patrikatik eta denbora librean; gazteen amets hautsien frustrazioa haiek ere jango dute eta. 24 urte adin ona da pilotari profesionala izateko eta bertan ibilbide oparo bat egiten hasteko pixkanaka, eta 18, salbuespenak salbuespen, gazteegia; kirolari baten ontze mentaleko prozesua eta puntu fisiko onena —atzelarietan, batez ere—, normalean, beranduago hasten baita. Urte tarte hori afizionatuetan ematea esperientzia ona da, asko ikasi ohi dute-eta jende zaharragoaren aurka jokatzen.

Espero dut Muruaren eta Aldaberen kasuek jarraipena izatea, eta ez begiratzea hainbeste adinari alde horretatik. Orokorrean enpresak lan oso ona ari dira egiten eta eskertu ere egin behar zaizkie gauzak, eta badakigu liga pribatu bat dela hau, non onenek jokatu behar duten, eta zaleok hala exijitu behar diegu beti, baina pazientzia pixka bat ere eduki dezatela. Pisuak altxatzen aritzeko ez da inoiz berandu, begiratu bestela Anthony Hopkinsi. ●

Eñaut Agirrebengoa

# «Amets handiak ditugu, baina ezin diogu gu geu izateari utzi»

## JUANJO OROZ

*Kern Pharmako zuzendaria*

Vueltan hiru garaipen lortu zituen Kern Pharmak, eta orain ProTeam mailako onenen artean finkatu nahi du. Etorkizunean Tourrean lehiatzea dauka begiz jota Orozek.



KERN PHARMA

Espainiako Vueltan izandako arrakasta dastatzeko apenas izan duen betarik Juanjo Orozek (Iruñea, 1980). Lan eta lan dabil, erronka berriei begira. «Irribarre batekin, hori bai». Emaitzak harrobi filosofiari eutsiz lortu ditu Kern Pharmak, eta aurrerantzean ere hala izatea nahi du Orozek. Zailtasunak zailtasun, txirrindulari multzoari eusten saiatuko da. «Geroz eta talde erakargarriagoa gara ziklistentzat».

**Igandean bi aste izango dira Vuelta bukatu zela. Lorturiko hiru garaipenen ondoren, nola sentitzen zarete orain?**
Zorioneko sentitzen gara Vueltan bizi izan dugun guztiagatik. Sekulakoa da kirol hau txikitatik maite izan dugunontzat. Harrobi filosofia da gure ardatza, eta pentsa noraino iritsi garen: hiru aldiz garaile munduko lasterketarik onenetako batean. Oso harro nago.
**Onenen pare aritu zarete, talde gonbidatua izanagatik. Oso gutxitan ikusten da hori itzuli handietan. Zein izan da sekretua?**
Gure balioei jarraituz lan egin izana. Gazteengan konfiantza osoa dugu: Vueltan aritu diren txirrindulari guztiak gazte mailatik ezagutzen genituen. Nik horri ematen diot balio handien. Norabidea alda dezakezu behin talde profesional bihurtuta, baina guk beti garbi eduki dugu zein den gure kirol kultura. Ez da erraza izan, baina orain dela hiru urte txirrindulari multzoa aldatu izan bagenu, ez ginen iritsiko iritsi garen tokira. Horrez gain, oso eskertua natzaie gainontzeko zuzendariei, sekulako lana egin baikenuen Vueltaren aurretik. Gauzak oso garbi izanik iritsi ginen lasterketara.
**Vueltaz harago, pozik zaude osatu duzuen denboraldiarekin?**
Bai, oso pozik. Gure ideiekiko fidelak izaten jarraitu nahi dugu, eta, era berean, UCIren sistemara egokitu behar dugu, puntuen bilaketan arreta jarrita. Bada, apustua hasieratik atera zaigu ondo. Emaitza onak lortu ditugu egun bateko probetan, baita Kataluniako Voltan eta Euskal Herriko Itzulian ere. Eta Vueltan, biribildu egin dugu denboraldia. Beste egutegi bat aton genezakeen, urte barruan garaipen gehiago lortzeko [bakarra zuten Vueltaren aurretik]; ordea, arreta lasterketarik onenetan jartzen dugu guk. Momenturik egokienean eman dugu mailarik onena.
**Bosgarren urtea duzue talde profesional gisa. Espero bezala ari zarete epeak betetzen, edo uste baino azkarrago zoazte?**
Kontinental mailan oso urte ona egin genuen, eta azken lau denboraldiak ProTeam mailan eman ditugu. Anbizio handia izan dugu beti, baina ez genuen espero Vuelta honetan hiru etapa irabazi, eta hamabost etapatan hamar onenen artean izaterik. Ez dakit fruituak espero baino lehenago jaso ditugun ala ez. Ordea, garbi dago zentzu guztietan ari ginela hazten. Pixkanaka eta etenik gabe hobetzea da gure helburua. Hala izan da orain arte, eta hala jarraituko dugu.
**Gazteak, behin loratuta, talderik indartsuenetara joaten dira. Pablo Castrillok, adibidez, berandu gabe egingo du urratsa. Onartua duzue dagoeneko egoera hori?**
Txirrindulariak hemen luzaro gelditzea nahi dugu guk. Modako taldea gara, egindako lanari eta lortutako emaitzei esker. Hemen arrakasta lor daitekeela erakutsi dugu. Geroz eta talde erakargarriagoa gara ziklistentzat. Gauzak hala, txirrindulari multzoari eustea da gure helburua, eta denok elkarrekin urratsak egiten jarraitzea. Ez nago itsu: badakit gure txirrindulariak interesgarriak direla munduko taldeentzat. Baina guk ere badugu zer eskaini.
**Dagoeneko hasiak zarete taldea indartzen. Nolako taldea osatu nahiko zenuke datorren urtean?**



«Modako taldea gara, egindako lanari eta lortutako emaitzei esker. Hemen arrakasta lor daitekeela erakutsi dugu»

«Guretzat funtsezkoa da Vueltan urtez urte lehiatzea. Beste koska bat igotzeko aukera emango liguke»

Pozik nago daukadan taldearekin. Harrobira jo dugu, eta, horrez gain, Mats Wenzel fitxatu dugu. Punta-puntako txirrindulari bat da; gaztea, eta talentu handikoa. Gainera, lan handia du gurekin egiteko. Horri garrantzi handia ematen diot. Gazte guztiak ez dira iritsi bezain pronto nabarmentzen, baina garbi dut txirrindulari handiak trebatzen jarraituko dugula. Arlo guztietan ari gara hobera egiten; kirol arlotik kanpo ere bai.
**Oso zaila da gorenean irautea; areago, harrobian oinarritutako talde batentzat. Erronka handia izango duzue hemendik aurrera.**
Gure esentzia galduta, ordea, dena galduko genuke. Amets handiak ditugu: Vuelta irabazi, Tourrean parte hartu... Baina hori ez litzateke arrakasta izango, gu geu izateari utziko bagenio. Guretzat, garaipenak lortzeko modua da garrantzitsuena. Hau da, emaitza horietara iristeko zer bide egin dugun, eta zer transmititu diogun jendeari.
**Hortik harago, zer helburu duzue esku artean?**
Talderik onenetako bat izan nahi dugu ProTeam mailan. Horrek sarbidea bermatuko liguke lasterketarik onenetan. Luze gabeko helburua da hori. Gora goaz UCIren sailkapenean, eta 26.ak gara orain. Bada, datozen bi urteetan 25 onenen artean finkatu nahiko genuke.
**Horrekin batera, Espainiako Vueltan urtez urte egoten saiatuko zarete, errotazio sistemari izkin eginez.**
Gu oraindik ez gaituzte bi urtez jarraian gonbidatu, eta hori funtsezkoa da guretzat. Erakusleiho handia izanik, hurrengo mailara joateko aukera emango liguke Vueltan urtez urte lehiatzeak. Antolatzaileei oso talde interesgarria garela erakutsi behar diegu. Bide onean gaude, eta itxaropena dugu.
**Zer iritsiko da lehenago: Frantziako Tourraren gonbidapena, edo World Tourreko lizentzia?**
Gure lehentasuna, oraintxe, Frantziako Tourra da. Helburu erakargarriagoa da guretzat.
**Datorren guztia garbi dago nori eskainiko diozuen: Manolo Azkona zenari.**
Bizikleta utzi eta bost egunera deitu ninduen. Plazer handia izan da urte hauetan harekin lan egitea. Orain, proiektua garatzen jarraitzea da egin dakioken omenaldirik onena. Geroz eta jende gehiago dago Kern Pharma bultzatzeko prest, eta oso pozgarria da. Vueltan, adibidez, zaletasun handia piztu dugu. Hori izan da garaipenik handiena. Inspirazio iturri izan nahi dugu. ●

# Euritan dantza egin du

→ Lanari eta ahaleginari esker, urrezko hiru puntu batu ditu Athleticek Leganesen.
→ Bigarren zatian iritsi dira golak: Vivianek eta Iñaki Williamsek sartu dituzte.

**0—2**

LEGANES ATHLETIC

**0-1.** Vivianek (65. min).
**0-2.** Iñaki Williamsek (75. min).



Dani Vivian eta Nico Williams, atzelariak Leganesi sartutako gola ospatzen. SERGIO PEREZ / EFE

**Jon Eskudero**

Gatibu musika taldeak bere agurra iragarri eta biharamunean, omenaldi polita egin zion atzo iluntzean Athleticek, Leganesen zelaian. Besteak beste, euria goian behean ari zuela, urrezko hiru puntu eskuratu baitzituzten zuri-gorriek, aurreratutako zazpigarren jardunaldiko partidan. Erasoan inspirazio handirik azaldu ez arren, jarrera, lana eta ahalegina hartu zituzten oinarri, eta, azkenean, merezita poltsikoratu zituzten hiru puntuak. Jokoan nagusi izan bazen ere, Ernesto Valverderen taldea antzu samar ibili zen gol aukeretan, baina bigarren zatiaren erditik aurrera jaso zuen uzta. Lehenbizi, Vivianen eta zortearen bidez iritsi zen 0-1ekoa, eta ondoren Iñaki Williamsek ebatzi zuen lehia, denboraldiko lehen gola eginez. Azkenerako, gozatuz eta gozaraziz amaitu zuen partida Athleticek. Euritan dantzan, alegia.

Hasierako hamaikakoan dezenteko iraultza egin zuen Ernesto Valderde entrenatzaileak. Espero zen hainbat jokalari aldatuko zituela freskotasuna lortu nahian, eta sei aurpegi berri zelairatu zituen: Gorosabel, Nuñez, Djalo, Unai Gomez, Berenguer eta Vesga. Lehen hirurak, udan egindako fitxaketak. Aldaketa asko izan arren, Athleticek ongi eutsi zien orain arteko izaerari eta jokoari, eta hasieratik bertatik hartu zuen bere gain baloia. Ruiz de Galarreta gidari, zuri-gorriek ederki mugitu zuten baloia ezker-eskuin, erasoko jokalariak mugimenduan ibili ziren etengabe, baina sakontasuna falta izan zuten min egiteko. Nico Williams eta Berenguer ahalegindu ziren hegaletatik jokaldiak osatzen, baina inspiraziorik eza sumatu zitzaien azken metroetan.

Bada, egoera horietara ohituta dago Leganes, eta atzean sartuta egonagatik, itxaroten asmatu zuen. Hala, 22. minutuan gola egiteko aukera bikoitza izan zuten madrildarrek. Kontraeraso bat muturreraino eramanda, De la Fuentek jaurtiketa bat egin zuen eta Hallerrek beste bat, baina biek Agirrezabalarekin egin zuten topo. Distiratsu aritu zen atzokoan atezaina. Aukera bikoitz horrek ez zuen aldatu lehiaren gidoia, eta lehengoan jarraitu zuen Athleticek. Ongi iritsi zen zelaiaren hiru laurdenetara, baina ezina sumatu zitzaien handik aurrera. Hain zuzen, 40. minutuan egin zuen lehen zatiko jaurtiketa bakarra, baina Djaloren ahaleginak atezainaren eskuetan amaitu zuen. Jokoan gehiago izan arren, emaitzan ezin izan zuten aginterik islatu zuri-gorriek.

### Aldaketak, inoizko goizen

Bigarren zatiari begira, atsedenaldian bertan astindu zuen aulkia entrenatzaileak, Guruzeta zelairatu baitzuen Nico Williamsen ordez. Hasieratik sumatu zen Leganesek urrats bat egin zuela aurrera, eta tarte batez sufritzea egokitu zitzaion Bilboko taldeari. Horregatik, Valverdek beste astindu bat eman zion zuhaitzari berandu baino lehen. Ez da ohikoa aldaketak hain goiz egitea, baina 56. minutuan beste hiru jokalari zelairatu zituen:: Sancet, Iñaki Williams eta Prados. Orduantxe, Leganesek zutoinera bidali zuen baloia, baina Athleticen jokoak behetik gora egin zuen handik aurrera. Ander Herrera zelairatzeak ere lagundu zuen zeregin horretan. Beste abiadura batean mugitu zuen baloia erasoan, eta hegaletatik erdiraketak egitea izan zuen helburu.

Bada, korner batean Vivianek langara bidali zuen baloia, eta hurrengo jokaldian gola sartzea lortu zuen atzelariak berak. Haren jaurtiketa batek Jorge Saenzen gorputzean jo ondoren, baloiak sareetarako bidea hartu zuen. Hori gutxi ez, eta hortik hamar minutura 0-2koa egin zuen Iñaki Williamsek, Gorosabelen erdiraketa ederki baliatu ondoren. Ordura arte ez bezala, erasoan zorrotz aritu ziren zuri-gorriak, eta horrek modua eman zien azkenerako, norgehiagoka amaiera lasaia izateko. ●

## Alavesek sendo segitu nahi du etxean

● **Alavesek ligako bi neurketa jokatu ditu denboraldi honetan Mendizorrotzan, eta bertan lau puntu batu ditu. 0-0 berdindu zuen Betisen kontra, eta 2-0 gailendu zitzaion Las Palmasi. Bada, Luis Garcia Plazak zuzentzen duen taldeak bide onetik segitu nahi du gaur etxean, Sevilla mendean hartuta (21:00, La Liga). Espainiako taldea denboraldi hasiera kaskarra egiten ari zen, baina aurreko asteburuan lehen garaipena lortu zuen Getaferen kontra.**

**Garcia Plazaren ustez, garrantzitsua da gaurko neurketa. «Bost jardunalditan 10 puntu lortzea oso kopuru ona litzateke. Itxura sendoa eman nahi dugu etxean». Toni Martinez eta Ander Gebara hasierako hamaikakora itzul daitezke.**




## Gaur hasiko da sanmateoetako torneoa

**PILOTA**— Gaurtik hilaren 29ra jokatuko dute udako azken feria: Logroñoko sanmateoetakoa (Espainia). Gaur, binakakoaren lehen atarikoa jokatuko dute, Adarraga frontoian (21:15, ETB1). Iñaki Artola eta Ruben Salaverri Iker Larrazabalen eta Ander Imazen aurka ariko dira. Irabazleek A multzoan jokatuko dute, beste bi bikoterekin: Jokin Altuna eta Xabi Tolosarekin, eta Javier Zabala eta Jose Javier Zabaletarekin.

Bihar, berriz, bigarren atarikoa jokatuko dute: Joseba Ezkurdia eta Julen Martija Dario Gomezen eta Beñat Rezustaren kontra (17:15, ETB1). Irabazleak B multzoan ariko dira, beste bi bikoterekin: Unai Laso eta Martxel Iztuetarekin, eta Jon Ander Peña eta Jon Mariezkurrenarekin.

Bi multzoek ligaxka jokatuko dute, eta lehen bi bikoteak finalean ariko dira 29an (17:00, ETB1).

## Hondarribiko finalak jokatuko dituzte gaur

**ZESTA-PUNTA**— Hondarribiko (Gipuzkoa) zesta-punta torneoko finalak jokatuko dituzte gaur Jostaldi frontoian (20:00). Lehenbizi, Grand Slamekoan ariko dira Jokin Arbe eta Guillen Oihenard, Bixente Gonzalezen eta Gorka Mugartegi *Atain*-en kontra. Jarraian, Master Seriesekoa jokatuko dute Elaia Gojenolak eta Maia Goikoetxeak, Maite Ortiz de Mendibilen eta Frida Watkinsen aurka.

## Anaitasuna Guadalajaran ariko da gaur

**ESKUBALOIA**— Anaitasunak irabazi egin zuen Asobal ligako lehenbiziko jardunaldian, eta, gaur, garaipen horri segida eman nahi dio Guadalajaran (Espainia), 21:30ean (La Liga+).




*Gu ere bai!* egitasmoak ofizialtasunaren alde egindako protesta bat, 2022an, Bilbon.
ARITZ LOIOLA / FOKU

# Ofizialtasunaren alde egiteko eguna

'Gu ere bai!' egitasmoa sortu eta lau urtera, euskal selekzioen eta euskararen ofizialtasuna aldarrikatzeko eguna egingo dute bihar Leitzan. Helburu horiek ipar, askotariko sektoreak batzeko beharraz mintzatu dira antolatzaileak.

**Iñaut Matauko Rada**

Euskal Herriko kirolari gutxik ordezkatu dezakete Euskal Herria nazioarteko txapelketetan, kirol gutxitan baitu euskal selekzioak lehiatzeko eskubidea. Gainontzeko kiroletan euskal selekzioaren ofizialtasuna lortzeko jardunari bultzada emateko jaio zen *Gu ere bai!* egitasmoa, duela lau urte, eta biharko egun osoko egitarau bat antolatu dute Leitzan (Nafarroa), Euskal Herrian Euskaraz-ekin, Gure Esku-rekin eta Tximutxe euskara taldearekin batera.

Kirola, hizkuntza eta lurraldetasuna uztartzea du helburu larunbateko egitarau «xumeak», Patxi Gaztelumendiren hitzetan; *Gu ere bai!* egitasmoaren kideetako bat da. Euskal selekzioen ofizialtasunaren egungo egoera «egin den borrokaren emaitza» dela azaldu du: «Kirol batzuetan, selekzioak ofizialak dira; esaterako, sokatiran. Gainera, nazioartean lan ona egiten ari dira, eta oso emaitza onak lortzen, adibidez berriki Alemanian egin bezala, edo Euskal Herrian jokatu zen munduko txapelketan».



> «Ofizialtasuna lortzeko, kirolariek planto egin behar izan zuten sari banaketetan, Sakanako neskek egin zuten bezala, adibidez»
>
> **PATXI GAZTELUMENDI**
> 'Gu ere bai!' egitasmoko kidea

Sokatira salbuespena da, baina beste kirol batzuetan ofizialtasuna lortzeko «aukerak egon badaudela» uste du Gaztelumendik, «leihoak ireki daitezkeela», eta pilota jarri du adibide. Euskal selekzioa lortzeko urratsak egiten ari direla uste du, baina gehiago falta dela onartu: «Lan egin behar da pasilloetan, bulegoetan eta nazioartean, baita gizarte arloan ere. Eta hor bat egin behar dute herri eragileek, kirolariek, federazioek eta erakundeek. Eta ipar hori hartuta, uste dugu aukera asko daudela kirol oso ezberdinetan ofizialtasuna lortzeko».

Izan ere, futbol selekzioaren ofizialtasun eskaerak zabaldu du gehien gaia, baina pilotaren inguruan daude azkenaldiko tirabira handienak, Nazioarteko Pilota Federazioak ez baitzuen Euskadiko Federazioaren ofizialtasunaz bozkatzen utzi ere. Hala ere, Gaztelumendik gertu ikusten du pilotako euskal selekzio ofiziala: «Lan asko egiten ari da, eta pilotako munduko txapelketak 2030ean Euskal Herrian jokatu aurretik emaitzak ikusi beharko dira. Ez dago ziurtasun osoz esaterik, baina beharbada 2026ko Argentinako munduko txapelketetan ikusi ahal izango dira euskal selekzioaren koloreekin Euskal Herriko kirolariak lehian».

### Kirolarien aktibazioa

Gaztelumendiren ustez, alor askotan egin behar da lan euskal selekzio ofizialak lortzeko, baina kirolarien aktibazioa gakoetako bat dela uste du. Sokatiraren adibidea jarri du: «Ofizialtasuna lortzeko, bai mutilek, bai neskek planto egin behar izan zuten nazioarteko froga batzuetako sari banaketetan, Sakanako neskek egin zuten bezala, adibidez».

Kirolarien borroka «oso garrantzitsua» bada ere, Gaztelumendirentzat estamentu guztietan egin behar da lan: «Ez dira garrantzitsuagoak kirolariak federazioak baino, edo federazioak instituzioak baino, edo instituzioak kaleko dinamika baino». Pauso gehiago emateko, baina, Gu ere bai!-k «euskal kirol selekzioen mahai bat edo bide orri bat» aldarrikatzen du, instituzioek, kirol estamentuek, kirolariek eta eragileek osatua, indarrak batzeko.

Euskal selekzioen ofizialtasunaren aldeko jaialdia egiteko, «herri kirolari, kirolzale eta euskaldun bat» aukeratu nahi zuten, Gaztelumendiren hitzetan, eta hasieratik ikusi zuten garbi Leitzak baldintza horiek betetzen zituela. «Nafarroako herria, kirolari emana erabat, eta oso herri euskalduna», hala definitu du Leitza.

Ibai Zabala pilotariaren eta Josu Etxaburu Gure Esku-ko bozeramailearen arteko solasaldi batekin hasiko dira, 10:30ean, eta jarraian karate, gimnastika, herri kirol eta txintxurrina erakustaldia egingo dute. Gero, omenaldi bat eta trikipoteoa izango dira, eta eguna bukatzeko, 17:00etan, pilota ikuskizuna izango da. ●

# Komunitatea

BERRIA ekonomikoki babesten duen komunitatearentzako gunea

## ESPERIENTZIAK

### Jendaurreko elkarrizketa Atef Abu Saifekin

**'Gazako egunerokoa'** liburuaren aurkezpena

Urriak 3 - 19:00
Antzoki Zaharrean, Donostian

Hizkuntza: euskara eta ingelesa
Aldibereko itzulpen zerbitzua egongo da

Gonbidapenak eskuragarri Donostia Kulturaren webgunean zein Donostiako Antzoki Zaharreko eta Viktoria Eugenia antzokiko leihatiletan



### Hitz etzanen jiran bertsotan, Biran

Bertsolariak:
**Maialen Akizu** eta **Andoni Egaña**

Gai jartzailea:
**Maddi Ane Txoperena**

Urriark 10 - 19:00
Bira, BILBO

8€ (+) 6€




BiRA



## ZOZKETAK

### Ezagutu Euskal Herriko oliogintza bertatik bertara

**BERRIAlagunentzako bisita gidatua eta dastaketa Erroiz Olioak-en lurretan**

Irailak 28

11:00-13:00

Lantziego, ARABA



## DENDA

### 'Gazako egunerokoa'

Egilea: **Atef Abu Saif**

Itzulpena: **Irene Arrarats Lizeaga** eta **Maialen Berasategi Catalan**

Argitaratzaileak:
**Elkar - Berria - Jakin**

20€







### 'Detaile xume bat'

Egilea: **Adania Shibli**

Itzulpena: **Aitor Blanco**

Argitaletxea: **Igela**

19,5€

(+) 16,6€




(+) BERRIAlagunanentzako abantailak

943-30 43 45 • *Berria.eus/komunitatea*

BERRIAlaguna bazara, egin eskaria eta etxera bidaliko dizugu

KULTURA




→ Donostia erdialdeko kaleak zinemari lotutako kartelez bete dira.
JAVIER ETXEZARRETA / EFE

# Begi guztiak pantailetara

→ Audrey Diwanen 'Emmanuelle' filmak emango dio hasiera gaur **Donostiako 72. Zinemaldiari**.

→ Javier Bardemek, Cate Blanchettek eta Pedro Almodovarrek **Donostia sari bana** jasoko dute.

**Ainhoa Sarasola**

Donostiako 72. Zinemaldiak prest ditu filmak, prest pantailak, eserlekuak, alfonbra gorriak, mintzaldien guneak eta argazkiak hartzeko lekuak. Zale askok eta askok salgai jarri bezain pronto erosi zituzten sarrerak, eta gaur helduko dira ikusleak ere aretoetara, begiak irudietan iltzatzeko prest. Audrey Diwan zinema zuzendariaren *Emmanuelle* filmarekin ekingo dio jaialdiak aurtengo programazioari, eta, bederatzi egunez, genero eta estilo ugaritako dozenaka film proiektatuko dituzte. Hilaren 28ko iluntzean, festibalaren amaiera ekitaldian jakinaraziko dute aurten zein film sarituko dituzten.

Bien bitartean, aitortza gehiago ere banatuko ditu jaialdiak: Donostia sari bana emango die Javier Bardemi, Cate Blanchetti eta Pedro Almodovarri.

## Sail Ofiziala

● Guztira, ikus-entzunezko 22 lan bildu ditu jaialdiak bere Sail Ofizialean. Horietatik, hamasei izango dira Urrezko Maskorra eta beste kategorietako sariak lortzeko lehian —sailaren barruan baina lehiaz kanpo emango dituzte, esaterako, Alauda Ruiz de Azua zuzendari bizkaitarraren *Querer* telesaila, eta itxierako filma, John Crowley irlandarrak zuzendutako *We Live in Time*—. *O corno* filmarekin iaz jaialdiko sari nagusia irabazi zuen Jaione Camborda zinemagile donostiarrak, eta hura buru duen aurtengo epaimahaiak erabakiko du nor saritu.

Audrey Diwanen *Emmanuelle* izango da lehia horren barruan erakutsiko duten lehen lana. *L'Evénement* filmarekin Veneziako jaialdiko Urrezko Lehoia irabazi zuen zinemagile frantsesak 2021ean, eta Donostian estreinatuko du bere lan berria, gaurko inaugurazio galan.

Azken urteotako joerari jarraituz, zinemagile beteranoak eta ibilbidearen hastapenetan direnak sail berean bildu ditu Zinemaldiak beste behin ere. Baina aurten «zuzendari handien filmak beste aldi batzuetan baino gehiago» izango direla adierazi du orain gutxi Jose Luis Rebordinos jaialdiko zuzendariak.

Horien artean daude, besteak beste, Costa-Gavras eta François Ozon, eta biak ala biak izan dira aurrez Donostian. Zinemagile greziarra —*Z* (1969), *Missing* (1981), *Music Box* (1989), *Amen* (2002)— lehian izan zen 2012ko jaialdian *Le capital* filmarekin, eta 2019an Donostia saria jaso zuen, baita *Adults in the Room* filma erakutsi ere. Mediku baten eta idazle baten arteko elkarrizketetan ardaztu du *Le dernier souffle* lan berria.

Ozonek, berriz, Urrezko Maskorra eta gidoi onenaren saria irabazi zituen *Dans la maison* (2012) filmarekin, eta jaialdiko lehian erakutsi zituen *Sous le sable* (2000), *Le refuge* (Epaimahaiaren Sari Berezia, 2009), *Une nouvelle amie* (2014) eta *Été 85* (2020). Oraingoan, *Quand vient l'automne* aurkeztuko du, zeinak Borgoinako herrixka batean bizi diren bi lagun dituen protagonista.

Beren lehen filma aurkeztuko duten zinemagileen artean, berriz, Xin Huo eta Laura Carreira daude, besteak beste. *Bound in Heaven* erakutsiko du lehenak, gaixotasun terminala duen gizon baten eta indarkeriak harrapatutako emakume baten istorioa kontatzen duena. Carreiraren *opera prima*-k, berriz, *On Falling* du izenburu, eta Eskoziako biltegi handi batean lan egiten duen emakume portugaldar bat du protagonista. Azken hori «ezusteko handietako bat» izan daitekeela iritzi dio jaialdiko zuzendariak.

Edward Berger (*Cónclave*), Pilar Palomero (*Los destellos*), Joshua Oppenheimer (*The End*), Mike Leigh (*Hard Truths*), Kiyoshi Kurosawa (*Hebi no michi*), Diego Lerman (*El hombre que amaba los platos voladores*), Gia Coppola (*The Last Showgirl*), Pedro Martin-Calero (*El llanto*), Maite Alberdi (*El lugar de la otra*), Iciar Bollain (*Soy Nevenka*) eta Albert Serra (*Tardes de soledad*) ere beren lanekin lehiatuko dira.

## Donostia sariak

● Donostia sariaren bidez, hainbat izar handiri zinemaren munduan egindako ibilbidea aitortu izan die urtero jaialdiak. Aurten sarituen zerrenda luzera batuko diren bi izen iragarri zituen jaialdiak, baina, denera, hiru Donostia sari banatuko ditu. Izan ere, Javier Bardem aktore espainiarrari joan den urtean egin zion aitortza hori —bera izan zen 71. aldiko kartel ofizialeko protagonista ere—, baina, Hollywoodeko gidoilari eta aktoreek egin zuten greba zela eta, aktorea ez zen Donostian izan. Garaikurra aurten jasoko zuela adostu zuten, eta hala izango da azkenean: gaur iluntzean, jaialdiaren inaugurazio galan emango diote saria *Perdita Durango* (1997), *Carne trémula* (1998), *Los lunes al sol* (2002), *No Country for Old Men* (2007), *Vicky Cristina Barcelona* (2008) eta beste hamaika filmetan lan egindako antzezleari.

Jaialdiaren aurtengo kartelеko protagonista, Cate Blanchett izango da bere garaikurra eskuetan hartzen hurrengoa: bihar iluntzean egingo dute hari saria emateko ekitaldia, eta *Rumours* filma proiektatuko dute ondotik, zeinak aktore eta ekoizle australiarra duen protagonista —Cannesen estreinatu zuten—. Bere ibilbide luzean zinema zuzendari esanguratsuekin egin du lan Blanchettek, hala nola Martin Scorsese, Steven Soderbergh,



Steven Spielberg, David Fincher, Ridley Scott, Sally Potter, Wes Anderson, Alejandro Gonzalez Iñarritu, Woody Allen, Peter Jackson, Todd Haynes, Richard Linklater, Guillermo del Toro eta Todd Fieldekin; eta berrehun aintzatespen baino gehiago jaso ditu bere interpretazioekin —tartean, bi Oscar sari, Veneziako bi Volpi Kopa, lau Bafta sari, lau Urrezko Globo, eta ohorezko Cesar eta Goya bana—. Zerrenda luze horri Donostia saria batuko dio bihar.

Pedro Almodovar zuzendari, gidoigile eta ekoizle espainiarra izango da azkena saria jasotzen, hilaren 26an, eta haren film berria proiektatuko dute sari banaketan: *La habitación de al lado*. Ingelesez egin duen lehen lana du zinemagileak, eta, hari esker, Urrezko Lehoia irabazi berri du Veneziako jaialdian. Hain zuzen, filmeko aktore protagonistetako batek, Tilda Swintonek emango dio garaikurra.

Almodovarrek ezagun du Zinemaldia, 1980an *Pepi, Luci, Bom y otras chicas del montón* filmarekin debuta egin ondotik, hainbatetan izan baita Donostian. *Carne trémula* (1998), *Todo sobre mi madre* (1999), *Hable con ella* (2002), *La mala educación* (2004), *Volver* (2006), *Los abrazos rotos* (2009), *Los amantes pasajeros* (2013), *Dolor y gloria* (2019) eta beste zenbait lan zuzendu ditu ordutik, eta ehundik gora sari irabazi ere bai; aurki izango du esku artean beste bat.

## Euskal zinema

● Euskarazko zenbait ekoizpen izango dira ikusgai jaialdian, bai Zinemira sailean, bai beste batzuetan. Zuzendari Berriak atalean lehiaren barruan erakutsiko du bere lan berria David Perez Sañudok, *Azken erromantikoak*. Txani Rodriguezen *Los últimos románticos* gaztelerazko nobela egokitu du zuzendari bilbotarrak, eta Miren Gaztañagak jokatu du rol protagonista; medikuek bularrean koskor bat detektatu ostean, bizitza goitik behera birplanteatuko duen emakumea.

Pello Gutierrez donostiarrak *Erreplika* aurkeztuko du Zinemiran, bere bigarren film luzea eta bakarka zuzendu duen lehena. Hutsuneei, irudiei eta oroimenari buruzko lan horrekin lehiatuko da Euskal Zinemaren Irizar saria eskuratzeko. Sari bera lortzeko hautagaien artean izango da Naia Laka Arrizubieta bilbotarraren *Zortzitik infinitura* lana, zeinak euskal zinemagintzaren historiari errepasoa eman dion. Dagoeneko historia horren parte den aktore batek, Elena Iruretak jasoko du aurtengo Zinemira saria.

Beste sail batzuetan ere izango da euskal zinemagileen lanik, hala nola Izibene Oñederraren *Etorriko da (Eta zure begiak izango ditu)* animaziozko film laburra, Zabaltegi-Tabakaleran. Eta Klasikoak atalean, Montxo Armendarizen *Tasio* film zaharberritua emango dute, Sail Ofizialean estreinatu zela 40 urte bete direnean eta Cannesko jaialdian iragan udaberrian erakutsi ostean.

## Perlak

● Nazioarteko beste zinema jaialdi batzuetan aitortza jaso duten filmen erakusleiho izaten da Perlak saila urtero, eta aurten Berlinalen, Cannesen, Venezian, Toronton, Annecyn eta beste hainbat festibaletan izan diren lanak bilduko ditu oraingoan ere; hamazazpi, denera. Jacques Audiarden *Emilia Pérez* filmak emango die hasiera saileko emanaldiei; lan hari esker, Cannesko Epaimahaiaren Saria eraman du aurten zuzendariak. Jaialdi berean Urrezko Palma irabazitako filma ere emango dute, Sean Bakerrek zuzendutako *Anora*, hain zuzen. Eta Cannestik pasatu ostean, Donostian izango dira Francis Ford Coppolaren *Megalopolis* eta Paolo Sorrentinoren *Parthenope* ere, besteak beste.

Horiekin batera, Adam Ellioten *Memoir of a Snail* (Annecyn Cristal sariaren irabazlea) eta Hong Sangsooren *Yeohaengjaui pilyo / A Traveler's Needs* (Zilarrezko Hartza Publikoaren Sari Nagusia azken Berlinalen) bildu dituzte sailera, besteak beste. Horiek ez ezik, Andrea Arnold, Emmanuel Courcol, Coralie Fargeat, Payal Kapadia, Mohammad Rasoulof, Walter Salles eta Paul Schraderren lanak ere publikoaren saria eskuratzeko hautagaien artean izango dira.

Venezian estreinatu ostean, Jon Garañok eta Aitor Arregik zuzendutako *Marco*-k izango du saila ixteko ardura; Belodromoan emango dute, lehiaz kanpo. ●



*Emmanuelle* filmaren fotograma bat. DONOSTIAKO ZINEMALDIA



## Gaurko egitaraua

### SAIL OFIZIALA

**09:00 ● EMMANUELLE.** Zuz: Audrey Diwan (Frantzia). Kursaala, 1.

**12:00 ● CONCLAVE.** Zuz: Edward Berger (Erresuma Batua - AEB). Antzoki Zaharra.

**14:45 ● LUMIÈRE!, L'AVENTURE CONTINUE / LUMIERE! THE ADVENTURE CONTINUES.** Zuz: Thierry Fremaux (Frantzia). Principe, 9.

**19:45 ● SOY NEVENKA / I AM NEVENKA.** Zuz: Iciar Bollain (Espainia). Antzoki Zaharra.

**21:00 ● EMMANUELLE.** Zuz: Audrey Diwan (Frantzia). Kursaala, 1.

**22:25 ● EMMANUELLE.** Zuz: Audrey Diwan (Frantzia). Kursaala, 1.

**22:30 ● EMMANUELLE.** Zuz: Audrey Diwan (Frantzia). Principe, 3.

### ZABALTEGI-TABAKALERA

**16:00 ● DAHOMEY.** Zuz: Mati Diop (Frantzia). Tabakalera-1. aretoa.

**18:15 ● SOUNDTRACK TO A COUP D'ETAT.** Zuz: Johan Grimonprez (Belgika - Frantzia). Tabakalera-1. aretoa.

**20:30 ● DAHOMEY.** Zuz: Mati Diop (Frantzia). Principe, 2.

**22:00 ● DAHOMEY.** Zuz: Mati Diop (Frantzia). Tabakalera-1. aretoa.

**22:30 ● SOUNDTRACK TO A COUP D'ETAT.** Zuz: Johan Grimonprez (Belgika - Frantzia). Principe, 2.

### ZINEMIRA

**16:30 ● LOS WILLIAMS / THE WILLIAMS.** Zuz: Raul de la Fuente (Euskal Herria). Principe, 3.

**20:00 ● LOS WILLIAMS / THE WILLIAMS.** Zuz: Raul de la Fuente (Euskal Herria). Principe, 9.

### ZUZENDARI BERRIAK

**09:00 ● GÜLIZAR / GULIZAR.** Zuz: Belkis Bayrak (Turkia - Kosovo). Kursaala, 2.

**12:00 ● LA GUITARRA FLAMENCA DE YERAI CORTÉS.** Zuz: Anton Alvarez (Espainia). Kursaala, 2.

**22:30 ● LA GUITARRA FLAMENCA DE YERAI CORTÉS.** Zuz: Anton Alvarez (Espainia). Kursaala, 2.

### FIPRESCI SARI NAGUSIA

**19:00 ● POOR THINGS / POOR THINGS.** Zuz: Yorgos Lanthimos (Irlanda - Erresuma Batua - AEB- Hungaria). Principe, 3.

### HORIZONTES LATINOS

**17:00 ● CUANDO LAS NUBES ESCONDEN LAS SOMBRAS / WHEN CLOUDS HIDE THE SHADOW.** Zuz: Jose Luis Torres Leiva (Txile - Argentina - Hego Korea). Kursaala, 2.

**18:15 ● CUANDO LAS NUBES ESCONDEN LAS SOMBRAS / WHEN CLOUDS HIDE THE SHADOW.** Zuz: Jose Luis Torres Leiva (Txile - Argentina - Hego Korea). Principe, 7.

**19:30 ● QUERIDO TRÓPICO / BELOVED TROPIC.** Zuz: Ana Endara (Panama - Kolonbia). Kursaala, 2.

**21:30 ● QUERIDO TRÓPICO / BELOVED TROPIC.** Zuz: Ana Endara (Panama - Kolonbia). Principe, 10.

### ATZERA BEGIRAKOA

**15:30 ● OSSESSIONE / OBSESSION.** Zuz: Luchino Visconti (Italia). Principe, 5.

**18:15 ● FUGA IN FRANCIA / ESCAPE TO FRANCE.** Zuz: Mario Soldati (Italia). Principe, 6.

**20:30 ● IN NOME DELLA LEGGE / IN THE NAME OF THE LAW.** Zuz: Pietro Germi (Italia). Principe, 5.

**22:45 ● BUONGIORNO, NOTTE / GOOD MORNING, NIGHT.** Zuz: Marco Bellocchio (Italia). Principe, 6.

### MADE IN SPAIN

**20:15 ● TIEMPO DE SILENCIO Y DESTRUCCIÓN.** Zuz: Joan Lopez Lloret (Espainia). Principe, 7.

**22:00 ● FLORES DEL CEMENTO / CONCRETE FLOWERS.** Zuz: Luismi Pantiga (Espainia). Principe, 9.

### PERLAK

**09:00 ● EMILIA PÉREZ.** Zuz: Jacques Audiard (Frantzia). Viktoria Eugenia.

**12:00 ● MEMOIR OF A SNAIL.** Zuz: Adam Elliot (Australia). Viktoria Eugenia.

**14:45 ● AINDA ESTOU AQUI / I'M STILL HERE.** Zuz: Walter Salles (Brasil - Frantzia). Antzoki Zaharra.

**16:00 ● EMILIA PÉREZ.** Zuz: Jacques Audiard (Frantzia). Viktoria Eugenia.

**17:15 ● ALL WE IMAGINE AS LIGHT.** Zuz: Payal Kapadia (Frantzia - India - Herbehereak - Luxenburgo). Principe, 9.

**19:15 ● MEMOIR OF A SNAIL.** Zuz: Adam Elliot (Australia). Viktoria Eugenia.

**22:00 ● AINDA ESTOU AQUI / I'M STILL HERE.** Zuz: Walter Salles (Brasil - Frantzia). Viktoria Eugenia.

**22:30 ● EMILIA PÉREZ.** Zuz: Jacques Audiard (Frantzia). Principe, 7.

**22:30 ● THE SUBSTANCE.** Zuz: Coralie Fargeat (Erresuma Batua). Antzoki Zaharra.

### HIZKETALDIAK

**12:00 ● FRANCINE MAISLER SOLASEAN MARÍA LAURA BERCHEKIN.** Tabakalera-1. aretoa.

**18:00 ● GLAMOURRAREN ATZEAN: AKTOREA KONTRATAZIO PARADIGMA BERRIEN AURREAN.** Tabakalera-Z aretoa.

### IKASTETXEAK BELODROMOAN

**10:00 ● ALAN GIZA ANTENA / LITTLE ALLAN - THE HUMAN ANTENNA.** Zuz: Amalie Næsby Fick (Danimarka). Belodromoa. [EAE].

[*] Prentsa eta akreditatuak
[ZB] Zuzendari Berriak saria.
[LK] Lehiaketatik kanpo.
[EAE] Euskarazko azpidatzi elektronikoak.
[EB] Euskarazko bertsioa.

# Iparraldea eta Hegoaldea elkarri so



EPPUR SI MUOVE
Begoña del Teso

Donostiako Zinemaldia hasten den ostiral honetan, kuriosoak, bitxiak, pozgarriak dira Iparraldeko eta Hegoaldeko saloi zinematografikoen artean suertatzen diren programazio bateratze kasik magikoak, ezustekoak arras. Donostiarako sarrerarik lortu ez baduzue, salto egin dezakezue, abilki, amoroski, bihurri, Bidasoaren beste ertzera eta han ikusi (ikusiko) betikotz galdutzat ematen zenituzten zinema puskak.

Esaterako... hilaren 21etik aurrera *Emmanuelle* izango duzue dastatzeko moduan Donibane Lohizuneko Le Selecten. *Emmanuelle* betikoa? Joan den mendeko 70eko hamarkadaren erotismo xuabe eta dotore haren ikurra, Sylvia Kristel gailurrera eraman zuena, ihizko besaulkiak modan jarri zituena? Ez, Hegoaldeko guztiok Iparrean ikusi genuen film hari itzuli sekulakoa ematen dion izen bereko beste batez ari natzaizue, Audrey Diwanek sinatua den hori dut nik begietan. Esanguratsua da zeharo Diwanek egina izatea. Berak ausart eta irmo ekarri baitzuen pantailara Annie Ernauxen *L'événement* eta bera epaimahai balent baten buru izan zen 2021eko Zinemaldian, zeinetan Terence Daviesen *Benediction* zeluloidezko mirariak gidoi onenaren saria eskuratu zuen.

Libanon sustraiak dituen idazle, kazetari, zinemagile frantziar horrek koxka bat gehiago estutzen du Emmanuelleren istorioa. Oraingoan, emakumea da desiraren eta plazeraren bila doana, gizonezkoak ehizatzen dituena. Oraingoan, bere desioko objektua den hori berarengandik aldentzen saiatuko da...

Donostiako Zinemaldian izango du nazioarteko estreinaldia. Akordio batera iritsi dira ekoizleekin eta filma frantziarra bada ere, ez da estreinatu bertako pantailetan, nahiz eta horretarako beta eta eskubidea izan, zinemaldi guztien araudiaren arabera. Hori dela eta, ekoizleekin lortutako hitzarmena dela medio, oraindik ez dago ikusgai Baionan edo Donibane Lohizunen. Bihartik aurrera, bai. Beranduenez, 27rako izango duzue Iparraldekook zuen etxe ondoko aretoetan...

*Emilia Perez* bada Iparrak eta Zinemaldian murgilduko den Hegoaldeak partekatzen duten beste altxor bat. Hilaren 11ko gau ilun, heze eta ekaiztsuan Jacques Audiarden marka guztien fuerakoa den filmak ireki zuen Hendaiako Les Varieteseko kultura denboraldia. Mukuru zen zinematokia eta ederra giroa Emiliari merezi duen harrera egiteko, *mexikar gaualdia* antolatu baitzuten bertan. Jaki minak ederto kozinaturik eta edateko tekila izan genituen plateretan eta basoetan, eta pantailan, Emiliaz gain, *Hijo de Sicario*, iaz Miarritzeko Zinemaldian txalo zaparrada jaso zuen Astrid Ronderorena.

Emiliak gaur irekiko du Donostian Perlak izeneko saila eta *Hijo de Sicario (Sujo)* bada Horizontes Latinos saileko aukera galdu ezinezkoa...

Bai, elkar begira daude Iparra eta Hegoa festibala hastear den honetan. Kontu bera gertatzen zaigu Berlinen Urrezko Hartza bereganatu zuen Mati Diopen *Dahomey*-rekin. Eman ditu jada hainbat egun Lapurdiko aretoetan, eta gaurko 16:00etan da estreinatzekoa Tabakaleran, Zabaltegi sailean. Dokumental fikzionatua dugu. Senegalen eta Frantzian sustraiak dituen zuzendariak Afrikako herrien identitateen berreskuratzearen inguruan egiten du hausnarketa eder eta sakona, Frantziak Beningo herriari bueltatuko dizkion eskultura batzuk bulkada gisa erabiliz. Bai, herrira bueltatzen dira lapurtutako altxorrak, pozez hartzeko moduko itzulia, baina bada oraindino zehaztu beharreko beste mila kontu: zer gara, zein dugu herri gurea, ba al gara arbasoak zirena? Zer ostu ziguten eskulturez aparte? Nortasuna agian?

Bai, Bidasoaren bi ertzetan, ardurak ardura, galderak galdera, zinema zinema. Hegoa eta Iparra elkarri so, filmak partekatuz. Errugbirako zaletasuna ere bai!!! Izan ere, zinema kontuetan beharra egiten duten hainbatek osaturiko Le Quinze de la Pelloche taldea Gipuzkoara dator. Zinemaldia aitzakia harturik, Zinemaldiarekin ametsetan, Hernaniko Landare zelaian lagunarteko partida jokatuko du bihar bertako Azeri Zaharrak izenekoen kontra. Esan, esaten dute Cannesen nahi dutela beste bat jokatu, baina nola egin uko eta muzin errugbia zinema bezainbeste maite duen lurralde batean indarrak neurtzeari?

Ez dago dudarik, mugak muga, ezerk ez du zinemak eta errugbiak bezain estu batzen, lotzen, baloiak eta zeluloideak zauritutako jendaia igualik gabea.●



**'DAHOMEY'.** Mati Diopen filmak sari nagusia irabazi zuen Berlinalen. BERRIA

# Kontalaritza eskola bat sortu dute Garaion Sorgingunean, ahozko transmisioa sustatzeko

→ **Hiru ikasturtez** kontzeptu teoriko-praktikoak landu eta ikuskizunak sortuko dituzte.

→ Azaroan hasiko dituzte lehen eskolak.

**Edurne Begiristain**

Arabazan elkarteak eta Vital fundazioak kontalaritza eskola bat sortu dute Ozetako (Araba) Garaion Sorgingunean. Ahozko transmisioaren garrantzia berreskuratzea eta profesionalen «kalitate artistikoa» sustatzea izango du xede. Azaroan hasiko dituzte lehen prestakuntza saioak.

Itziar Rekalde aktore, idazle eta Arabazaneko ordezkariak, eta Arantxa Ibañez de Opakua Vital fundazioko zuzendariak azaldu dute asmoa. «Kontalaritza istorioak kontatzeko, komunikatzeko eta adierazteko artea da. Ofizio bat da, egitura, arau, tresna eta lengoaia propioak dituena, eta horrek prestakuntza espezifiko bat eskatzen du», azaldu dute. Haatik, urteen joan-etorriarekin ahozko transmisioa apalduz joan dela ohartarazi dute, batez ere euskaraz. «Gure hizkuntza bizirik mantentzea lortu dugu, baina komunikatzeko eta geure burua eta inguratzen gaituen mundua zuzenean eta ahots argiz azaltzeko gaitasuna galtzen ari gara».

Ahozko adierazpena, ahozko jarioa eta hizkuntzaren erabilera egokia nahiz komunikazio sozial eraginkorra galtzen ari direla esan dute, eta hori berreskuratzeko asmoz jarriko dute abian eskola. Hala, eskolaren eginkizunak hauek izango dira, besteak beste: narratzaileak prestatzea, beste arte batzuekin bat datozen arloak lantzea, ahots narratiboa eta estiloa garatzea, adierazpen teknikak ezagutzea eta transmisioa sustatzea. Kontalaritza ofizioari buruzko jakintzak eskuratu ostean, kontakizunaren sorkuntza bera landuko dute.

Horretarako, hiru ikasturteko trebakuntza eskainiko du eskolak. Lehenengoan eta bigarrenean, kontzeptu teoriko-praktikoak landuko dituzte, eta hirugarrenean ikuskizunak sortuko dituzte. Lau irakasle izango dira: Itziar Rekalde bera, Juan Kruz Igerabide idazlea, Jose Campanari aktore eta antzerki zuzendaria, eta Oihana Ameskua Filosofia irakaslea eta Agora filosofia elkarteko kidea.

**Zortzi emanaldi**

Ahozko kontakizunari lotutako zortzi emanaldi ere programatu ditu Vital fundazioak hurrengo hilabeteetarako. Ofizioa sustatzeko, lan aukerak emateko eta publikoa zaletzeko helburua izango dute, eta euskaraz eta gaztelaniaz emango dira. Dorleta Kortazar Alkoz, Boniface Ofogo Nkama, Ainara Iñiguez, Ane Arrugaeta, Jose Campanari, Aitor Vinagret, Carolina Rueda, Odei Arregi eta May Gorostiagak eskainiko dituzte. ●

Itziar Rekalde Arabazan elkarteko ordezkaria eta Arantxa Ibañez de Opakua Vital fundazioko zuzendaria. VITAL KUTXA FUNDAZIOA

MAX. ≤-1 | 0-4 | 5-9 | 10-14 | 15-19 | 20-24 | 25-29 | 30-34 | 35-39 | ≥40





# EGURALDIA




## Eguraldi aldakorra

Askotan hodeiak eta ostarteak agertuko badira ere, hodeiak ugaritu, eta baliteke zaparradak eta ekaitzak izatea nonahi, arratsaldetik aurrera batez ere. Litekeena da, gainera, leku batzuetan zaparradak handiak izatea. Haizea hego-ekialdekoa izango da, eta zakar ibiliko da barnealdeko haizeguneetan.

**JOERA**

Larunbata, 21

Igandea, 22

Astelehena, 23

| | Bihar | Igandea | Astelehena | Asteartea |
|---|---|---|---|---|
| BAIONA | 17 / 23 | 17 / 19 | 15 / 19 | 14 / 19 |
| BILBO | 16 / 23 | 16 / 21 | 13 / 21 | 12 / 22 |
| DONIBANE GARAZI | 15 / 24 | 14 / 20 | 12 / 19 | 12 / 20 |
| DONOSTIA | 18 / 24 | 16 / 20 | 14 / 20 | 14 / 20 |
| GASTEIZ | 14 / 22 | 12 / 20 | 9 / 20 | 7 / 20 |
| IRUÑEA | 16 / 20 | 14 / 19 | 12 / 19 | 11 / 19 |
| MAULE | 15 / 24 | 13 / 20 | 11 / 19 | 11 / 19 |
| TUTERA | 17 / 21 | 16 / 22 | 14 / 22 | 13 / 21 |

**ITSASOA**

Hego-ekialdeko haizea ibiliko da, 3ko indarrarekin; arratsaldean, ipar-ekialdekoa. Itsaso kizkurra izango da, arratsaldean itsaskirriko guneekin. 0,5 metro inguruko olatuak izango dira.

| ITSASALDIA | ORDUA | METROAK |
|---|---|---|
| Itsasbehera | 00:24 | 0,21 |
| Itsasgora | 06:39 | 4,66 |
| Itsasbehera | 12:43 | 0,27 |
| Itsasgora | 19:01 | 4,81 |

**ISOBARA MAPA**



| EGUZKIA | SORTU | GORDE |
|---|---|---|
| | 07:58 | 20:14 |

| ILARGIA | EGUNA |
|---|---|
| Ilbehera | Irailak 24, asteazkena |
| Ilberria | Urriak 2, asteazkena |
| Ilgora | Urriak 10, osteguna |
| Ilbetea | Urriak 17, osteguna |

**BIHAR**

Tarteka giro lasai eta eguzkitsua izango da, baina berriz ere giroak nahastera egingo du, eta baliteke zaparrada trumoitsuak izatea, bereziki arratsaldetik aurrera.

# EKITALDIAK

1



## Bisita gidatua: Baionako karriketatik

*Mintzalasai* Baiona-Angelu-Miarritze euskalduntzeko proiektuaren barrenean, Baionako bisita gidatua eskainiko dute gaur. Hiriaren historia eta gertakariak kontatuko dituzte, eta katedralak, karrikak eta harresiak ikusiko dituzte.

**Ibilaldia.** Baionari bisita, bihar, 14:30ean.



2

## Bertsolaritza: Bertso kantuan

Gaur gauerako bertso saioa antolatu dute Aizarnazabalen (Gipuzkoa). Lau bertsolari arituko dira kantuan: Nerea Ibarzabal, Andoni Egaña, Oihana Iguaran eta Julio Soto. Igotz Alkorta izanen dute saioa gidatzen.

**Bertsoaldia.** Gaur, 22:30ean, Aizarnazabalgo (Gipuzkoa) frontoian.



3

## Musika: Aniztasunaren alde

Bilboko Udal Musika Bandak kontzertua eskainiko du gaur: *Lasaitasuna eta Irrikak*. Gonbidatu bat izanen dute taldeko buru: Borja Romero. Aniztasunaren aldeko aldarria eginen dute, eta, beraz, omenaldia.

**Kontzertua.** Bilboko Udal Musika Banda, gaur, 17:00etan, Azkuna zentroan, Bilbon.



Emaguzu zure inguruko ekitaldien berri: **agenda@berria.eus**
Euskal Herriko kultur ekitaldien agenda: **berria.eus/zerbitzuak/agenda**

# EKITALDIAK

**Arrasate** Anixe, Claudia Diaz, Izadi Zumalde eta Anari. Gaur, 19:00etan, Monterronen.

**Baiona** Antzerkia: *Taberna-ria*. Gaur, 20:30ean, Biltxoko elkartean.

**Bergara** Bertso saioa. Unai Iturriaga eta Ane Zuazubiskar. Gaur, 22:30ean, Arrano tabernan.

**Bilbo** Eneko Dieguez Quartet. Gaur, 20:00etan, Jazzon aretoan.

**Bilbo** *Lasaitasuna eta irrikak*. Bilboko Udal Musika Banda. Gaur, 20:30ean, Azkuna zentroan.

**Deba** Antzerkia: *Ninini*. Antton Telleria. Aurrestreinaldia. Gaur, 20:00etan, kultur elkartean.

**Donostia** Fino Oyonarte eta Giorgio Bassmatti. Gaur, 20:30ean, Dabadaban.

**Errenteria** The Donkey Riders (17:00) eta Esanezin (19:00). Gaur, plazan.

**Errenteria** Akaleia. Gaur, 18:00etan, Kalekaian.

**Errenteria** Queralt Lahoz eta Safu. Gaur, 23:00etan, Itsasargi Nagusian.

**Hendaia** *RR_6_eRRe(AH)ala*. Maialen Lujanbioren bertso-poesia performancea. Gaur, 20:30ean, Borderline fabrikan.

**Iruñea** Bardoak: Nafarroako taldekako bertso ekimena 2024: Drimtim & Assurancetourix. Gaur, 19:00etan, Zaldiko Maldikon.

**Lekeitio** *Popperra, afterra, utopia*. Miren Narbaiza eta Danele Sarriugarte. Gaur, 22:00etan, Leokako labaderoan.

**Urnieta** Bertso afaria. Sustrai Colina eta Onintza Enbeita. Gaur, 20:00etan, Oianumen.

**Urruña** Bertso sariketa: Eneritz Artetxe, Ramuntxo Christy, Eneko Lazkoz, Oihane Perea, Aitor Servier eta Maddi Ane Txoperena. Gaur, 19:00etan, Postako gelan.

# DENBORA-PASAK

## HITZ GEZIDUNAK

Ipar Amerikako basamortua, bere baitan Heriotzaren harana hartzen duena

Zutarri, pilare / Kutsagarria
Esku-zorroak / Gizonezko bati, hika
Idi, hitz elkarketan / Erraz
Frantziako hiria / Zinka
Kurrika txikia / Nafarroako kontzejua
Emakume izena / Moztua
Leku / Ikusi-..., zer ikusi?
Pairatu, jasan / 20 aurpegiko poliedroa
Metal mota / Zezen zikiratu
Auhenak, adiak / *Irudiko basamortua
Ahulduak / Antzezle
Jakingo balu / AEBetako estatua
Zegoena / Lerroa, errenkada
Bokala / Bi ken bat
Nafarroako udalerria / Ez eme
Laidoak
Buruaren alde / Lakarrako herritarra
Amerikako estatua / Txistua, listua
Bokala / Herri hizkeran, eta
Bokal mehea / Zuberoako herria
Kanpo, landa / Oinarrizko edaria
Zirkonioa / Libanoko hiria
Malguago egin / Makala
Europa eta Asia / Gure planeta
Andana, samalda / Patata batean hiru
Landare mota / Laborarien lanabes
Noka, naiz / Nafarroako udalerria
Alokairua / Txakur
Urte kopuru / Kontso. bustia
Letra grekoa / Potasioa
Bizkaieraz, auzia / Kontsonantea
Katilu txikiak
Frantziako departamendua

## SUDOKU ERRAZA

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 6 | | | | | 1 | | 7 | |
| | | | | 4 | | 1 | | 8 |
| | 4 | | | | | 9 | | |
| | | 4 | | 2 | 5 | | | 1 |
| 1 | | | | 7 | | | | 9 |
| 8 | | | 9 | 1 | | 7 | | |
| | | 3 | | | | | 9 | |
| 7 | | 5 | | 3 | | | | |
| | 8 | | 5 | | | | | 3 |

## SUDOKU EZ HORREN ERRAZA

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | | | | 6 | | | | 5 |
| 5 | | | 7 | | | 2 | | 3 |
| | 7 | 1 | | | | | 6 | 9 |
| | | | 6 | | 7 | | 9 | |
| | 3 | | | | | | 2 | |
| | 1 | | 3 | | 8 | | | |
| 4 | 9 | | | | | 8 | 5 | |
| 1 | | 5 | | | 3 | | | 2 |
| 6 | | | | 8 | | | | |




| | | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| L | E | P | R | A | Z | U | B | I | T | Z | A |
| I | L | E | A | B | A | S | A | T | I | A | K |
| M | I | Z | P | I | R | A | P | O | N | P | A |
| A | Z | A | L | L | E | P | O | A | D | O | I |
| T | O | K | I | K | A | A | R | R | A | U | N |
| A | N | T | Z | I | N | L | E | O | T | Z | J |
| R | D | O | A | K | O | Z | A | B | U | K | A |
| J | O | R | R | A | N | E | D | O | Z | E | R |
| A | J | E | O | N | T | Z | I | T | O | R | I |
| B | I | A | N | A | Z | I | G | A | R | R | O |
| A | R | T | E | L | A | N | A | O | N | A | K |
| L | A | U | Z | A | T | U | I | S | E | K | A |

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 4 | 8 | 5 | 2 | 9 | 3 | 7 | 1 | 6 |
| 3 | 9 | 2 | 7 | 6 | 1 | 8 | 5 | 4 |
| 7 | 1 | 6 | 5 | 8 | 4 | 9 | 2 | 3 |
| 8 | 2 | 3 | 4 | 1 | 7 | 5 | 6 | 9 |
| 9 | 6 | 4 | 3 | 5 | 8 | 2 | 7 | 1 |
| 1 | 5 | 7 | 9 | 2 | 6 | 3 | 4 | 8 |
| 2 | 7 | 1 | 6 | 3 | 9 | 4 | 8 | 5 |
| 6 | 4 | 9 | 8 | 7 | 5 | 1 | 3 | 2 |
| 5 | 3 | 8 | 1 | 4 | 2 | 6 | 9 | 7 |

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| 1 | 6 | 9 | 2 | 5 | 3 | 7 | 8 | 4 |
| 4 | 2 | 8 | 7 | 6 | 1 | 5 | 3 | 9 |
| 5 | 3 | 7 | 8 | 9 | 4 | 1 | 6 | 2 |
| 2 | 1 | 4 | 5 | 3 | 8 | 6 | 9 | 7 |
| 7 | 5 | 6 | 1 | 4 | 9 | 8 | 2 | 3 |
| 9 | 8 | 3 | 6 | 2 | 7 | 4 | 5 | 1 |
| 8 | 7 | 5 | 3 | 1 | 2 | 9 | 4 | 6 |
| 6 | 4 | 2 | 9 | 7 | 5 | 3 | 1 | 8 |
| 3 | 9 | 1 | 4 | 8 | 6 | 2 | 7 | 5 |

# Izua uhinetan



**EKOGRAFIAK**
Gaizka Izagirre

Donostiako Zinemaldia ate joka dugu —gaur hasiko da— eta, bederatzi egunez zinema aretoetatik atera gabe egongo naizenez, egunotan plataforma digitaletan zintzilik geratu zaizkidan zenbait izenburu ikusteko aprobetxatu dut. Horietako bat Filmineko *Monolith* filma izan da.

Irudi gordinen bidez ikusleak izutzea nahiko ariketa erraza izan liteke. Soilik soinua edota hitzak erabiliz ezinegona sortzea, ordea, askoz zailagoa da. Film honetan hori da lortu dutena: izua soinuaren bidez helaraztea.

Kokaleku bakar batean filmatutako pelikula da, eta aktore bakar batekin; gainerako pertsonaiak ahotsaren bidez soilik entzungo ditugu, telefono deien bidez. Argitu gabeko misterioen inguruko podcast bat egiten ari den kazetari baten inguruko istorioa azaltzen du; bloke beltz arraro batzuei buruzko kasu bat ikertzen hasi da. Zientzia-fikzioa eta thriller psikologikoa uztartzen dituen intrigazko proposamen hau murgiltze-esperientzia interesgarria iruditu zait; Lily Sullivanen antzezpen lan aparta, eszenaratze minimalista zehatza eta soinu-diseinu oso landua dira filmaren hiru euskarri nagusiak. Baliabide gutxiko ekoizpena da, baina ehuneko ehunean zukutzen ditu. Podcast ugarirekin gertatzen den moduan, ikuslearen buruan irudi boteretsuak sortzeko gai da: hitza eta hizkuntza funtsezko elementuak dira. Misterioz beteriko atmosfera sortzea lortu dute eta ziurgabetasunez beteriko kontakizun berezi batean murgiltzen gaituzte hasieratik. Hori bai, filmaren hasierako sotiltasuna eta zorroztasuna eremu labainkor batean sartzen da amaieran; gidoiak, erabat iradokitzailea den premisa batetik, oso agerikoa eta apur bat arruntagoa den azken zatiraino garamatza.

Izenburuak 2021eko *Calls* telesaila gogorarazi dit, originala eta nahiko berritzailea. Bederatzi istorio dira guztira, eta beldurra, thrillerra eta suspensea nahasten ditu. Zenbait pertsonaren arteko telefono deietan oinarritutako kontakizunak dira, baina irudirik gabekoak; telesail osoan soinua soilik iritsiko zaigu. Tira, pantailan irudi batzuk badaude, baina entzungai ditugun elkarrizketak indartzeko sortu dituzten soinu-uhin moduko batzuk dira; protagonisten elkarrizketen testuak ere irakurgai daude. Ahalik eta gehien gozatzeko eta murgiltzeko, erabili aurikularrak. ●

# Baina ez da 'Hondar ahoak'

'Zeru ahoak' telesailak nolabaiteko jarraipena emango dio 'Hondar ahoak' produkzioari. Nerea Garcia protagonistaren atzetik, Bilboko aldirietaraino helduko da ikuslea. Filmaketa aurreikusi bezala doa, eta espero dute lana prest izatea urte amaierarako.

**Irene Barañano Diaz**

BILBO— Bilbo eszenatoki bihurtu du *Zeru ahoak* telesailaren filmaketak. «Ekin!», oihukatu dute kameraren atzetik Olabeaga kaiaren 36. zenbakian. Itsasadarren alboan daude, langile itxurako auzo marjinal batean, Zorrotzaurre uhartearen paisaia postindustrialari begira. Nerea Garcia protagonistaren etxea izango da. Norabide bakarreko kale estua beltzez jantzitako langilez bete dute, eta Koldo Almandoz zuzendaria kameraren pantailari begirik kendu ezinik dabil.

Bost aste eta erdi iraungo dute filmaketa lanek, eta hirugarren astea dute hau. Plana espero bezala betetzen ari direla nabarmendu du Marian Fernandez Pascal ekoizleak. *Hondar ahoak* egiteko baino aurrekontu handiagoa duten arren, «denboraz eta aurrekontuz beti motz» ibiltzen direla aitortu du, «gauzak aurrekoan baino hobeto egitea» izaten dute-eta erronka. Aktore berriekin aritzea zuten erronketako beste bat, baina azaldu du oso gustura ari direla.

Nagore Aranburu eta Sara Cozar aktoreek kale erdian filmaketako langile baten aginduak entzun bitartean, figuranteek *Zeru ahoak*-i buruzko hipotesiak eztabaidatu dituzte, errepide ertzean eserita daudela: «Nagore Aranburu ez al zen berriz agertu behar zuen aktore bakarra?», «Bai zera, hor duzu Cozarren pertsonaia ere». *Spoiler*: Bai, aktore gehienak aldatu egingo dira, protagonista eta beste pare bat pertsonaia salbu.




**FILMAZIOA.** Bilbon ari dira egunotan *Zeru ahoak* telesaila filmatzen. MONIKA DEL VALLE / FOKU

### Urratsei jarraikiz

*Hondar ahoak*-en jarraipena izango da *Zeru ahoak*, edo, hobeto esanda, zuzendariaren hitzetan, «Nerea Garcia protagonistaren bizitzaren jarraipena». Aranbururen pertsonaiak *Hondar ahoak*-en, hau da, Ondarroan bizi izandakoaren ostean, Ertzaintza utziko du, eta etxera itzuliko da, Bilbora. «*Hondar ahoak*-en, protagonista kanpotarra zen, arrotza zitzaion herri batean zegoen. Orain, Bilboko periferian ibiliko da, ingurugiro urbano eta ilun batean», Almandozek azaldu duenez.

Bilbo izango da tramaren epizentroa, baina Getxoraino zabalduko dira dardarak. Egun hauetan, pasaitarrek ere ikusi ahal izango dituzte filmaketaren zatitxoak, baina inguru hark ez du pisurik izango telesailaren kontakizunean.

Zuzendariak adierazi du zera zaiola interesgarri: «Ertzaintzatik kanpo egonda, jadanik ez dela agintearen morroia, jada ez duela izango biolentziaren monopolioa, poliziak izan ohi duena, eta tramari aurre egiteko beste tresna batzuk erabili beharko dituela». 2020an girotua zegoen *Hondar ahoak*, eta fidel eutsi diote denbora lerroari. 2024an, protagonista langabezian egongo da, autoa salduko du, eta Bilboko aldirietan biziko da. Igartzen da zuzendariak atxikimendu berezia diola protagonistari: «Nerea berezia da, bere iraganarekin arazoak ditu, sozializatzeko zailtasunak, baina ikerketarako dohainak ere baditu».

Almandozek aitortu du esfortzu berezia egin duela ikusleek *Hondar ahoak* telesailaren usaina hartu bai, baina, aldi berean, beste telesail bat sortzeko, «errepikakorra izango ez den ekoizpen bat» lortzeko. Hala iradokitzen du izenburuak. «Aurrekoa oso goitik behera egin genuen, hondarrari, lurrari, arreta berezia jarrita», argitu du; «oraingoan, ikuspegia asko aldatzen da, estoldetatik zerura apuntatuko dugu errealizazio aldetik, baina baita planteamendu aldetik ere».



**«Aurrekoa hondarrari begira egin genuen. Oraingoan, estoldetatik zerura apuntatu dugu errealizazioan eta planteamenduan»**

**KOLDO ALMANDOZ**
Zuzendaria

Euskaraz egindako produkzio honek, aurrekoak bezala, lau kapitulu izango ditu, baina apur bat motzagoak, 35 minutukoak. Aurreikusia dute filmaketa urriaren bukaerarako amaitzea, eta, dena ondo bidean, espero dute 2025. urte hasierarako prest izatea. ●



Beatriz gozotegiak sona handia dauka Iruñean, batez ere haien garrotiko ezagunengatik. 2019an lokal berria ireki zuten Curia kalean, eta baita Estafetakoa mantendu ere. Bolada batez itxita egon ostean, aurki ateak irekiko ditu.

# Garrotikoak hiriaren altxor

**Ane Etxandi**

IRUÑEA— Curia kalean gora egin ahala, Iruñeko katedrala amaieran, usain bereizgarri batek betetzen du dena. Ohiko irudia da ilarak ikustea 16. zenbakiaren bueltan. Turistak eta erromesak, jakin-minez, erakusleihoan pilatzen dira, dendan zer saltzen ote duten argitzeko. Bat baino gehiago ilarara gehitzen da gero. Izan ere, Beatrizek badauka ahalmen hori: jendea erakartzeko eta harrapatzeko ahalmena.

«Egin berriak dira, ilusioz eta gogoz eginak», azaldu du Lourdes Gomezek, Beatriz gozotegiko jabeetako batek. Hori da, omen, arrakastaren sekretua. Multinazionaletatik eta handikietatik at, negozio txikiek dituzten egiteko moduak nabarmendu ditu. 25 urte daramatzate Lourdes eta Asun Gomez ahizpek Beatriz gozotegian lanean. Palmerak, opilak, madalenak eta pastak egiten dituzte. Baina badago dendan nagusi ukaezin bat: garrotikoa.

Hostorea eta txokolatea. Besterik ez. Agian sinpletasun horretan dago xarma. Hala ere, prozesua ez da hain sinplea, eta lan handia eskatzen du. Goizeko 04:30ean pizten ditu sukaldeko argiak Lourdes Gomezek. Hurrengo egunerako hostorea prestatzen hasi, eta aurreko egunekoa txokolatez bete. Izan ere, oreak egun batez egon behar du hozkailuan. Arrautzarekin busti, eta labera. Geroago Asun Gomez iristen da, eta eskariak prestatzen hasten da.

**Aspaldiko saltokia**

25 urte daramatzate bi ahizpek Beatrizen lanean, baina negozioak badu historia luzeagoa. 60ko hamarkadan Pablo Saraldik lokala eskuratu, eta bere emaztearen izena eman zion. Garai hartan hasi zen bikote hura pastak eta gozoak egiten, eta orduan hasi zen ezaguna egiten gozotegia hirian; Saraldi sukaldean eta Beatriz salmahaian. Seme-alabarik izan ez zutenez, negozioaren jarraipena kolokan egon zen bolada batez. Lourdes Gomezen senarrak lehengaiak banatzen zizkion gozogileari, eta lotura horri esker jarraitu zuen aurrera dendak.

Urtebetez aritu ziren Gomez ahizpak Saraldirekin lanean, Estafeta kaleko lokal mitikoan, errezeta guztiak ikasteko eta negozioaren nondik norakoen berri jakiteko. Oso harreman ona eraiki zuten: «Estafeta kalean bizi ziren, eta edozein arazo izanez gero, edo errezeta bat gaizki ateraz gero, berehala etortzen ziren laguntzera», adierazi du Gomezek.

2019. urtean Curia kaleko denda ireki zuten, bestea txiki geratzen baitzitzaien. Biak mantendu zituzten bolada batez, baina, COVID garaiko segurtasun neurrien ondorioz, eta eraikin osoa berritzeko eraikuntza lanak egin zituztela-eta, itxi egin behar izan zuten. Berriro ere irekiko dute aurki. «Estafetan oso gustura geunden, oso harreman ona geneukan jendearekin. Herri txiki bat bezalakoa da. Bi aste barru berriro irekiko dugu». ●



**BEATRIZ GOZOTEGIA.** Joan den irailaren 13an, garrotikoak eta beste hainbat gozo, Beatriz dendan, Iruñean.
IÑIGO URIZ / FOKU



«Estafeta kalean oso gustura geunden, harremana geneukan jendearekin. Herri txiki bat bezalakoa da»

**LOURDES GOMEZ**
Iruñeko Beatriz gozotegiaren jabea

# Ezurtearen keriak dira

**Urte biz behingoa tokatzen da 2024ko sagar uzta. Euskal Sagardoa jatorri izenekoa aurkeztu dute Irungo Etxezabal baserrian: iazkoaren %30 biltzea aurreikusten dute; bi milioi kilo sagar inguru.**

**Enekoitz Telleria Sarriegi**

Ez da apeta, eta gehitxo da ziurrenik keria dela esatea ere, baina horixe izaten du sagarrondoaren naturak: urte biz behin ematen duela uzta oparoena. *Ezurte* deitzen diote oparo ematea tokatzen ez zaion urte horri, eta halakoxea da 2024koa. Hasi dira sagarra biltzen sagasti gehienetan, eta datozen egunetan hasiko dira oraindik hasi ez direnetan. Ez zuten kontrakorik espero, zikloa errepikatu egiten baita, eta halaxe jakinarazi dute: «Iazko urtearekin alderatuta, heldutasuna atzerago dator sagastietan, sagar gazietan gehienbat. Uzta txikiagoa espero da, ezurtea tokatzen delako, neguan ez duelako hotz handirik egin, eta udaran egindako bero zakar kolpe batek uztaren parte bat hondatu duelako». Iazkoaren %30 biltzea aurreikusten dute. Alegia, bi milioi kilo inguru.

Irungo Etxezabal baserriko sagastian (Gipuzkoa) egin dute uztaren aurkezpena, non bestela. Baina han ez da aipatutako eskasiaren arrastorik: hori da hori sagarrondoen ederra. Jatorri izeneko uztaren nondik norakoak azaldu, eta sagarraren bueltan egindako azken azterketak, proiektuak eta apustuak xehatu dituzte baserriko ugazabak okasiorako prestatutako belazeen berdean. Izan da katiuskak jarrita agertu denik, baina ez dute inor jarri lanean. Kizkiak eta saskiak apaingarritarako gelditu dira. Zaldiak ari dira aldameneko belardian larrean, eta haien zintzarri hotsa izan da aurkezpeneko soinu banda.

Han izan dira, besteak beste, Iker Iglesias Eusko Jaurlaritzako Elikagaien Kalitateko eta Industriako zuzendari berria, Mikel Azpiri Gipuzkoako Foru Aldundiko Nekazaritza eta Lurralde Oreka Saileko teknikaria, Lander Sagaseta Nafarroako sagar ekoizlea, Ainhoa Larrea Euskal Sagardoa jatorri izeneko eta Fruiteleko kidea, Aitor Etxeandia Fruiteleko teknikaria, Oihana Gainzerain Euskal Sagardoa jatorri izeneko lehendakaria, eta Unai Agirre koordinatzailea.

Agirrek azaldu du ez dutela alferrik Irun aukeratu aurkezpenerako. Ipar Euskal Herria eta Nafarroa Euskal Sagardoa jatorri izenaren barruan sartuko dira laster, eta elkargune horri egindako keinua izan da «mugako herri» hori aukeratu izana.

Ainhoa Larrea sagar ekoizle eta Fruitel elkarteko kideak azaldu du 2024ko sagar uzta nolakoa datorren: «Ezurtea denez, iazkoaren %30-40 biltzea espero dugu. Neguan hotz handirik egin ez izanak eta udako bero kolpe horrek ez du askorik lagundu, baina duela gutxi egindako euriak bai. Balio izan du sagarrak gorputza hartzeko eta gizentzeko. Baina aurtengo uzta atzeratuta dator besteekin konparatuta». Agirrek eman ditu zehaztasun gehiago. Nabarmendu duenez, iazko uzta horren handia izaki, pentsa zitekeen aurtengoa txikia izango zela, eta hala gertatuko da. Esan du uztak orekatzeko proiektuek emaitzak emanagatik ere zaila izango dela oreka hori Euskal Herri guztira zabaltzea, eta, aurten bezala, beste zenbait faktorek laguntzen ez badute, uzten arteko aldea handia izango dela. Sagardoaren graduaziori buruz, berriz, zera: «Uzta txikiak izaten direnean, azukre gehiagoko sagarrak izan ohi dira normalean, baina aurten, udako euria dela medio, iazkoaren antzeko alkohol graduazioa izango dute. Iruditzen zaigu sei bat gradura iritsiko dela».

Lurraldez lurralde hartuta, Agirreren azalpena: «Gipuzkoan, sagar gehiago dago Goierrin Beterrin baino, neguan hotz handiagoa egin zuelako. Bizkaian ere antzeko zerbait gertatzen da. Araban badaude sagasti batzuk iaz eman ez zutenak, eta, orain, horiek badute sagarra. Nafarroan ere, antzera. Ipar Euskal Herrikoei —gaur ezin izan dute hemen izan, azkenean— uste baino sagar gehixeago azaldu zaie, eta, iazkoarekin alderatuta, %60 inguru biltzea espero dute». Euskal Sagardoa jatorri izeneko koordinatzaileak nabarmendu du joan den asteetan egindako euriak mesede handia egingo diola sagarrari: «Sagarra saneatu egin du. Ikusten duzue zer-nolako aleak dauden hemen. Lehen alea txikia zen, eta hazten ari da. Dagoen sagar hori oso sano dago».

Koska handi samarra dago: 2023an sei milioi kilo sagar bildu zituzten, eta 2024an bi milioi biltzea espero dute. Kuriosoa da ohartzea sagardogileek «ezurtea» eta «urte biz behingoa» aipatzen dituztela, baina teknikariek «uzten alternantzia». Eta horri



Irungo Etxezabal baserriko sagastian aurkeztu zuten atzo 2024ko sagar uzta. GORKA RUBIO / FOKU



250

**SAGAR EKOIZLEAK.** Euskal Sagardoa jatorri izenaren barruan, 250 sagar ekoizle daude gaur egun, eta 500 hektarea inguru sagasti kudeatzen dituzte. Beste 155 hektarea ekoizpenean sartuko dira laster.

106

**SAGAR MOTAK.** Euskal Sagardoa jatorri izenak 106 sagar mota dauzka onartuta, baina horietatik 24 dira sagardogile bakoitzak bere nahasketa egiteko erabiltzen dituenak. Nafarroa eta Ipar Euskal Herria jatorri izenean sartzean, 250ekoa izango da sagarren zerrenda.

2

**SAGAR KILOAK, MILIOITAN.** Horixe biltzea espero dute. Aurreikuspena baino ez da, baina iaz bildutakoaren aldean nabarmen txikiagoa. 2023an, Euskal Sagardoa jatorri izeneko sei milioi kilo sagar bildu zituzten. 2022an, berriz, bi milioi kilo, ezurtea izan baitzen.


Sagarrez betetako sagarrondoetako bat. GORKA RUBIO / FOKU


2024ko uztaren aurreneko muztioa. GORKA RUBIO / FOKU

konponbidea eman nahian lanean segitzen dutela nabarmendu du Aitor Etxandia Fruitel elkarteko teknikariak: «Helburua da alternantzia hori desagerraraztea». Nola? Egindako azterketa eta entseguen berri eman du Etxandiak. Loreen mamitzea hobetu nahian dabiltza ekoizpen txikia duten sagastietan, eta loreen bakanketa jorratzen ari dira. Ez dira denak emaitza onak izan, baina bada indarra hartzen ari den aukera bat: txertakak erabiltzea. «Geneva txertakak erabiltzen ari gara. Txertakak oso garrantzitsuak dira sagarrondoen kalitateari dagokionez. Eragina dute arbolaren tamainan, fruituen kalibrean, ekoizpenean... Eta txertaka familia berri bat agertu da: Geneva txertakak. Ekoizpen potentziala igo egiten dute, sagarrondoak azkarrago hasten dira fruitua ematen, erresistenteak zaizkie gaixotasun eta izurrite batzuei, eta saguek eta satitsuek ez dituzte maite».

Hori guztia aintzat hartuta, Etxandiak aurreratu du sagasti bat sortuko dutela Gipuzkoako Foru Aldundiaren Otalarrea lursailean, Villabona-Amasan. Hamalau sagar barietate izango dira, eta sei Geneva txertaka. Aztertuko dute txertaka horiek nola uztartzen diren bertako sagar barietateekin eta nola eragiten duten ekoizpenean. Betiere, ezurteen ziklo hori goxatu nahian.

Eta behin goxatzen hasita, aurkezpenak ere gozoa izan du amaiera. Urteko lehen sagar muztioa dastatu dute bertaratu direnek, eta uzta ez horren oparoaren alde topa egin. ●


GORKA RUBIO / FOKU

# «Sektorea sufritzen ari da; ez diot etorkizun errazik ikusten»

**OIHANA GAINZERAIN**
*Euskal Sagardoa jatorri izeneko lehendakaria*

Ia bost urte karguan egin ostean, lehendakaritza uztera doa Gainzerain. Oiharte sagardotegiko Maite Retolazak ordezkatuko du.

**E. Telleria Sarriegi**

IRUN— Oihana Gainzerainek (Hernani, Gipuzkoa, 1979) azken aldiz aurkeztu du sagar uzta jatorri izeneko lehendakari gisa. Zelaia sagardotegian jarraituko du: «Borrokan. Gure tokiari eusteko, eta enpresa familiarrek dituzten zailtasunei aurre egiteko».

**Zer balantze egiten duzu?**
Orokorrean, gazi-gozoa. Batetik, jatorri izenak egin duen ibilbidea oso emankorra izan da, oso positiboa, eta sektorearentzat beharrezkoa. Bestetik, ordea, sagardoaren sektorea sufritzen ari da, eta ez diot etorkizun erraza ikusten. Ez sagardoari, ez sagarrari.

**Etorkizun errazik ez? Non daude, bada, zailtasunak?**
Lehen sektoreak dituen arazo berberak dauzkagu: sagasti berriak sortu dira, baina baserrietan arazoak daude belaunaldi berriekin. Eta sagardotegietan ere gauza bera ari da gertatzen. Errentagarritasunarekin ere arazo handia daukagu: salmentak ez dira guk nahi bestekoak, eta ez da lortzen sagardoa merkatuan posizionatzea. Sagardotegi batzuk itxi egin dituzte, eta gehiago itxiko dituzte etorkizunean.

**Baina jendearen inpresioa ez da hori, ezta? Aberasten ari zaretela diote.**
Kontziente gara horretaz; hori ere badagoela. Guk disfrutatzeko produktu bat saltzen dugu, gauza positibo bat, festa giroan, txotx garaian, sagardoa dago nonahi, eta sagardotegiak batean eta bestean, baina sektorearen errealitatea beste bat da. Txotx garaiaren negozioak, ikusgaitasuna ematen duen horrek, hiru hilabete irauten du. Zenbakietara eramaten duzunean, ez da hainbeste. Atzean benetan dagoena sagardoa bera da. Eta horren errealitatea beste bat da.

**Bat baino gehiago harritu egingo da.**
Badakit inpresioa bestelakoa dela. Askotan entzuten dugu txotx garaian: «Ze ondo bizi zareten. Hiru hilabetez lan egiten duzue, eta urte osoan primeran bizi zarete gero». Eta irribarre batekin hartzen dituzu halakoak, han bertan hau guztia kontatzen ez hasteagatik, baina egia dena da sektoreak beste errealitate bat duela, datuak direnak direla, eta sagardotegiak ixten ari direla. Beste sektoreetan gertatzen den hori ez da sagardogintzan gertatzen: enpresa handiak etortzen direla inbertitzera edo erostera. Sagardotegiak ez dira erosten. Hori zerbaitengatik da.

**Jatorri izenak zure agintaldian eman duen albiste positiboena izan da Euskal Herri osoko sagardoa jasoko duela?**
Oso albiste ona izan da hori. Jatorri izena jaio zenean, *Euskal Sagardoa* izena jarri zitzaionean, oso kontziente ginen Euskal Herri osoko proiektu bat izan behar zuela. Hori zen gure nahia. Une hartan ez zegoen hori lantzeko aukerarik, baina ez dugu ikuspuntu hori sekula galdu. Ipar Euskal Herriarekin lan egiteko aukera sortu zen, eta Nafarroarekin ere aritu gara. Haien partetik ere beti egon da interesa. Markak berak zentzu handiagoa hartzen du, eta ekoizteko ere aukera asko irekitzen dira.

**Ezurtea izateak horrenbeste eragiten du zuen jardunean?**
Bai, eta asko. Guk urteko produktu batekin lan egiten dugu. Sagardoa urtean ekoitzi eta saltzen da, eta merkatuak jarraitutasuna eskatzen dizu. Horretarako, zure ekoizpenak ere behar du egonkortasun bat: ezin duzu urte batean asko izan eta hurrengoan gutxi. Eta sagarrak, une honetan, ez digu hori ematen. Desoreka horrek eragin egiten digu, guk urtero antzeko kopurua daukagulako ekoitzi beharra, lortu duzun merkatua, lortu duzun salmenta urtetik urtera bermatu beharra daukazulako. Horretan ari dira denak lanean: Fruitel, aldundiak, unibertsitateak... Uztak orekatuagoak izan daitezen. ●



2024ko irailaren 20a, ostirala
www.berria.eus



**Egoitza nagusia:** Martin Ugalde kultur parkea. Gudarien Etorbidea, z/g 20140 Andoain
**Telefonoa:** (0034) 943 30 40 30
**Posta elektronikoa:** berria@berria.eus
**Publizitatea:** publi@bidera.eu






ATZEKOZ AURRERA

# «Argazki on batek atentzioa piztu behar du, normaltasunetik atera»

**LUIS LIZARRALDE** *BERRIAren udako argazkien lehiaketako irabazlea*

Ekaitz giroak erakarri zuen Lizarralde, eta argazki bakarra atera zion arratsalde trumoitsuari. BERRIAren saria jasota amaitu du bidea.

**Unai Zubeldia**

ORIO— Argazkilari izanda aktore protagonista bihurtzea, horixe izan du lanik zailena Luis Lizarraldek (Orio, Gipuzkoa, 1959). Hark irabazi du BERRIAren udako argazkien aurtengo lehiaketa, Orioko hondartzan ateratako argazki batekin. Beste sari bat irabazteko moduan aritu da hitz aspertuan.

**Uda, hondartza, itsasoa, ekaitza... ez dirudi hain zaila horrelako argazki on bat ateratzeak...**
Zaila ez da; tokatu egin behar zaizu, eta, tokatzen zaizunean, ikusi. Ez baita gauza bera tokatzea eta ikustea. Desberdintasunaren bila joaten naiz ni.
**Zu joan zinen argazkiaren bila edo argazkia etorri zen zuregana?**
Ikusi egin nuen argazkia, eta ni joan nintzen bila, zer zegoen ikusita. Bueltaxka egin genuen Amaia emazteak eta biok, berak lagun batekin topo egin zuen, eta ekaitza pasatzen ikusi nuen nik. Sorosleak nola zeuden jabetu nintzen, eta hara joan nintzen. Argazki bakarra atera nuen. Zortea aipatzen da askotan, baina zortea bilatu egin behar izaten da; zortea ez, haren bila joan nintzen.
**Argazkilari izatea ez baita klik egitea bakarrik...**
Desberdintasuna non dagoen begira joaten gara beti.
**Argazki irabazlea ez da izango sakelakoarekin ateratakoa, ezta?**
Ez, ez. Sakelakoarekin dokumentatu egiten da, baina argazkia kamerarekin ateratzen dut nik beti. Fuji markako argazki kamera bat daukat, pisuagatik batez ere.


Luis Lizarralde, aste honetan, Orioko hondartzan, garaile atera den argazkiarekin. JON URBE / FOKU

**Gauza bakarra falta da argazkian: Orioren trainerua.**
Ibilitakoa naiz haiei argazkiak ateratzen ere; semea neukan etxean arraunlaria. Hari bakarrik ateratzen hasi nintzen, baina pixkanaka-pixkanaka gehiago eta gehiago atera nituen.
**Epaimahaikoen zalantza bat: Photoshopik ba al du argazkiak?**
Ez. Behin ere ez dut aurkeztu Photoshopekin landutako argazkirik. Gauza bakarra egiten dut: Raw formatuan atera argazkia, horrek aukera ematen baitizu gero argiekin eta itzalekin pixka bat jolasteko.
**Luis Lizarralde... argazkilaria?**
Nik kamera soinean eramaten dut beti, baita mendira joaten naizenean ere, behin ere ez baita jakiten argazki ona noiz tokatuko den.
**Zer behar du argazki on batek?**
Argazki on batek atentzioa piztu behar du, normaltasunetik atera. Paisaiak-eta ikusten ditugu askotan, eta politak dira, bai, baina argazkiak beste zerbait behar du niretzat, besteek ikusten ez duten hori.
**Argazkiak, koloretan edo zuri-beltzean?**
Nik koloretan ateratzen ditut beti, baina egia da zuri-beltza asko gustatzen zaidala. Argazkiaren araberakoa ere izaten da hori; zuri-beltzera pasatu edo koloretan mantendu. Oraingo honetan, kontrastea ematen du koloreak, gorritasun horrek, eta horregatik mantendu nuen koloretan.
**Oraintxe zoaz argazkilari baten ametsetako paradisura: jubilaziora.**
Erretiro aurreratua hartuta nago, eta datorren hilean hartuko dut erretiroa. Horixe da guztion ametsa: behin erretiroa hartutakoan denbora izatea norberaren gustuko gauzak egiteko.
**Zeure kabuz ikasitakoa zara?**
Erabat. Nik ez dut egin ikasketarik; besteen argazkiak ikusiz ikasi dut. Argazki bat ateratakoan, zeinen ondo dagoen ikusi beharrean, pikorra edo okerra non dagoen ikustera joaten gara. Horrela ikasten da. Horrelako sariek motibazioa areagotzen dute.
**Bi lagunentzako otordua Getariako Elkano jatetxean. Azken astebetean nabaritu al duzu normalean baino jende gehiago inguratu zaizula goxo-goxo?**
[Barrez] Badaezpada, ezta? Erabakia hartuta dago, zalantzarik gabe [ondoan dauka emaztea, eta hari begiratu dio].
**Zein aholku emango zenioke argazki kameran lehen klik soinuak ateratzen hasi denari?**
Begira joateko beti, eta ibilian-ibilian ikasteko. ●

**LOTSABAKO**

**Inoiz atera duzun argazkirik onena?** Gustukoena, ilargiari ateratako bat, erdian hegazkina duela.
**Eta ateratzeko daukazuna?** Islandian aurora borealei aterako diedana.